**AURKIBIDEA**

## AURKEZPENA

Tortura Giza Eskubideen bortxaketa larria da eta horrexegatik zigortzen du Nazioarteko Zuzenbideak. Hau dela eta, 1984eko abenduaren 10eko Giza Eskubideen Agiri Unibertsalaren 5. artikuluak dioenez, "inork ere ez du ez torturarik ez zigor zein tratu anker, ezgizatiar edo degradagarririk jasango". Baina torturaren debekua Nazioarteko Zuzenbideko araua da, Estatu guzti guztientzat, nazioarteko gizarte osoarentzat, betebehar juridiko "erga omnes" sortzailea.

Estatu espainiarrak gaurdaino tortura debekatzen duten komenio eta agiri guztiak sinatu eta berretsi ditu. Hauexek dira horietako batzuk:

- Eskubide Zibil eta Politikoei buruzko Nazioarteko Ituna, 1977ko apirilaren 27an berretsia.
- Giza Eskubideak eta Oinarrizko askatasunak Babesteko Komenio europarra, 1979ko urriaren 4ean berretsia.
- Giza Eskubideen Babeserako Komenio europarreko 6 zenbakidun Protokoloa, 1985eko otsailaren 4ean sinatua, salbuespen batez, gerra garaiko delitu militarrengatik oraindik badagoen heriotze zigorrari dagokiona alegia.
- Tortura eta Bestelako Tratu Anker, Ezgizatiar edo Degradagarrien aurkako Nazioarteko Konbentzioa, 1985eko otsailaren 4ean sinatua.
- Tortura eta Zigor edo Tratu Anker, Ezgizatiar edo Degradagarrien Prebentziorako Komenio europarra.

Agiri guzti hauek torturaren praktika gorrotagarriaren aurkako bidean aurrerapauso garrantzitsua dira baina ez dira berez torturra errotik desagertaraz dezaketen "formula magikoak".

Aurretik esandako guztiaz gain, gure Elkartera oraindik ere iristen dira tortura hauterestiak. Txosten honen bidez salaketa guzti horiek eta tortura gure gizartetik desagertarazteko behar diren mekanismoak aztertu nahi dira.

Tortura gertatzen den lekuan nabarmentzea garrantzitsua bada ere, gure ahalegina berori desagertarazten bildu behar dugula uste dugu eta horretarako Estatuak bere esku dauden prebentziorako mekanismo guztiak jarri behar ditu.

## SARRERA

Tortura delitu berezitzat kalifikatzeak, hots, subjektu aktiboa beti funtzionari bat izan beharrak tortura hiru leku ezberdinetan gertatzea eragiten du, hala nola, atxiloketa zentroak, polizi kontrolak eta kartzelak.

Ondoren eremu hauetako bakoitzean torturak dauzkan ezaugarriez egingo dugu gogoeta.

## I. ATXILOKETA ZENTROAK

1992an atxiloketa kopuruak izugarri egiten du gora eta kasurik gehienetan atxilotutakoek tortura jasan dutela adierazi dute. Bizkaia eta Gipuzkoa izan dira herrialderik ukituenak eta ondoren Nafarroa.

1992an salatutako torturak aurreko urteetakoekin alderatzen baditugu, tortura metodoak gero eta sofistikatuagoak direla ikus dezakegu. Tortura sexuala eta arrastorik utzi ez baina beren azken helburua, gizabanakoaren nortasunaren erabateko suntsiketa alegia, lortzen duten bestelako praktikak nabarmetzen dira. Zoritxarrez, torturaren ondorioak fisiko zein psikologikoak dira baina epe luzera, azken hauek dira irauten dutenak eta biktimarentzat gogorrenak.

Torturaren esperientziak norberaren identitatea zalantzan ipinarazten duen prozesua dakar. Tortura metodoak, baina batez ere atxiloketa prozesua, helburu horretara zuzentzen dituzte atxilotuari gizakiaren ezaugarri guztiak ukatzen baitzaizkio.

Atxiloketaren inguruabarrak (gauekotasuna, neurriz kanpoko bitartekoak, indarkeria...) eta zaintza zentrorainoko lekualdaketa gune ezin hobeak dira tentsio giro eta defentsen suntsiketa egoerarako.

Inkomunikazioa aplikatzen den kasuetan (gehienez bost egun iraun Dezakeena) atxilotua kanpoko guztitik bakarturik dago. Ez daukate senitartekoekin inolako harremanik, ez eta konfidantzako Abokatu batekin ere. Ikusten dituen pertsona bakarrak, poliziez gain, Auzitarako Medikua eta Ofiziozko Abokatua dira. Harreman hauek (Xtik Xera bitarteko orrialdeetan tajutzen direnak), ez dira atxilotuak isolamendu egoera hori apurtzeko besteko konfidantzazko inguruabarretan gertatzen.

Atxiloketak irauten duen bitartean kolpeak, mehatxuak eta bestelako tortura mota jasan behar izaten dute, bai halaber, hiritar guztiak kontrolpean edukitzeko poliziak daukan gaitasuna adierazteko etengabeko presioa ere.

Guzti honen ondorioz, atxiloketaren ondoren gorabehera psikopatologikoak dauzkaten pertsonak gero eta gehiago dira. Gorebeherarik naharoenak sentipen nahasmena, beldur somatikoa, depresio sindromea eta sintoma paranoideak dira.

## II. POLIZI KONTROLAK

1992an ikusi ahal izan da ere polizi kontrolak nabarmenki areagotu direla. Kontrol horietako biktimen adierazpenen azterketen arabera, nabarmena da ere gero eta indarkeria gehiago erabiltzen dutela eta tratu txarrak gauza arrunta direla. Kasurik gehienetan ilunabarrean gertatzen dira, izugarrizko poliziªhedapenaz eta denbora luzea irauten dute.

Biktima errepidetik urruntzen dute eta galdeketa, eraso, umiliazio eta mehatxuak jasan behar izaten ditu.

Tortura mota hau tortura "zolia" dela esan dezakegu, torturaren erasokortasun guztia ordu gutxi batzuetan pilatzen baita.

Torturaren helburu berbera izan arren, kasu hauetan garrantzi berezia dauka beldurtu nahiak, hasiera hasieratik egoeraren kontrola beraiek (polizi taldeak) daukatela argi eta garbi utziz.

## III. KARTZELAK

Azkenik, kartzeletako egoera aipatu nahi dugu. Lekualdaketetan eta baita zentroetan bertan ere presoei ematen dizkieten jipoi eta erasoei buruzko berri kezkagarriak iristen zaizkigu.

Berez presoaren gutxienezko eskubideak (ikasteko eskubidea, osasunerako eskubidea, bisitak edukitzeko eskubidea e.a.)zaurtzen dituen kartzel erregimenaren iharduera txarrari, indarkeria fisikoa gehitu behar zaio. Kartzelan jasandako jipoiei buruzko salaketa askotan torturaren arrasto fisikoak begibistakoak dira. Honekin batera doa ere urgazpen medikoa jasotzeko itxaron behar duten denbora luzea.

1992an azpimarratzekoak dira euskal preso politikoek, bizi baldintza duinak galdatzeko daukaten baliabide bakarra denez, egin dituzten hamaika gose grebak. Greba hauek egitearen arrazoia sarritan presoren bati emandako jipoia izan da.

Jasotako datuen arabera, greban zehar ez eta amaitutakoan ere ez zaie urgazpen mediko egokia eskaini, eta honek askotan osasuna bera jarri du arriskutan zuzperketa egokia eragotziz.

1992an El Salto del Negro kanariar kartzelan bizi izan duten muturreko egoera azpimarratu nahi dugu; bertan, hiru gose greba egin dituzte, guztira 108 eguneko erabateko baraua. Kartzela honetan 1991n beste lau gose greba egin zirela ere gogoratu behar dugu.

Informazio guzti hau eta torturengatik zigortutako poliziak mailaz igo eta indultatu egiten dituztela ikusteak, gure ahalegin guztia tortura den errealitate hau jakinarazi eta salatzen pilatu behar dugula pentsarazten digu. Egoera honen biktima ez dira zuzenean jasaten dutenak soilik, gizarte guztia baizik. Horrez gain, tortura ahalbideratzen duena suntsitu beharra dago. Honela, 1997ko apirilaren 27an Estatu espainiarrak berretsitako Eskubide Zibil eta Politikoei buruzko Nazioarteko Itunaren 7. artikuluak dioena errealitate bilakatuz: "askatasunik gabeko pertsona oro gizalegez eta gizakiari dagokion duintasunarekiko begirunez tratatuko da".

# TESTIGANTZEN BIDEZ JAKINDAKO TORTURA KASUAK

## 1.ARTOLA MENDIBE, MARIO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/6, etxean
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila
ONDORIOA........................ Kartzela 92/1/10
EPAILEAREN AURREAN ADIERAZPENAK EGITEARI UKO EGIN ZION.

Bere testigantzan dioenez, atxiloketan balaz zauritu zuten izterrean eta ezkerreko hankako zangarra eta peronea apurtu zizkioten. Egoera horretan Antiguoko koarteleko garajeetara eraman zuten eta bertan torturatu. Ondoren Donostiako Gurutze Gorrira eraman zuten, bertan ebakuntza egin zioten eta handik Madrilgo Gregorio Marañon Ospitalera eraman zuten. Ospitale bietan zein Madrilerako bidean tratu txarrak jasan zituen. Aipatutako torturak hauek dira; kolpeak gorputz osoan, batez ere ezkerreko hankan, elektrodoak barrabiletan, bularrean eta ahoan, boltsa eta buruko batez itodura eragin. Hil egingo zutela esan zioten ahoan pistola bat jarriz eta beste batean sero-boltsan ur burbuilak utziz.

## 2.BERRONDO LABIANO, ALFREDO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/14, kalean.
POLIZI TALDEA................... Polizi Talde Nagusiak
ONDORIOA........................ Aske kargurik gabe, 92/1/18
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Bere testigantzan irakur daiteke gorputz osoan kolpean jaso zituela, itodura sortuz "boltsa" jarri ziotela, adats zatiak atera zizkiotela, behin baino gehiagotan esan ziotela hil egingo zutela. Galdeketak jarraiak izan ziren, baita irain eta umiliazioak ere.

## 3.LABAT IBARROLA, GORKA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/14, kalean.
POLIZI TALDEA................... Polizi Talde Nagusia
ONDORIOA........................ Aske kargurik gabe, 92/1/18
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Bere testigantzan gorputz osoan zehar jo zutela dio, bere familia

eta bere buruaren aurkako mehatxuak egin zizkioten, hil egingo zutela eta elektrodoak jarriko zizkiotela alegia.

## 4.URRA GURIDI, KEPA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela.
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Atxilotu eta gutxira Basurtuko Ospitalera eraman behar izan zuten. Ospitaletik jakinarazi zutenez, bertan izu-krisialdi batez sartu zen eta honek medikuei erantzun eta eragingarrien aurrean erreakzionatzea eragotzi zion 12 orduz gutxi gorabehera. Bere testigantzan irakur daitekeenez, atxilotu eta berehala mendira eraman zuten eta bertan jipoitu, "boltsa" jarri zioten, pistola baten kanoia sartu zioten ahoan balarik gabe tiro eginez, eta guzti hau etengabeko mehatxupean. Handik La Salveko Koartelera eraman zuten eta bertan torturatu egin zuten berriro. Historiale klinikoan agertzen denez, urtarrilaren 30eko 20:30ean erizain bat eskatu zuten Urraren gelatik "lagundu" oihua entzun ondoren. Gelan sartu eta bi pertsona aurkitu zituen (Goardia Zibileko teniente eta numeroa) eta Kepa Urra ahotik odola zeriola. Epailearen aurrean Ospitalean torturatu egin zutela salatu zuen. Interrogatzen saiatzen ari zirenean eskuez itotzen ahalgindu zirela esan zuen. Kartzela zigorra dekretatu ondoren, Alcala©Meco Kartzelako aurrearretapean daudenen pabilioiko erizaindegira eraman zuten, eta han egon zen 22 egunez.

## 5.ROJO GONZALEZ, JUAN RAMON

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/2
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

1992ko otsailaren 2an Epaitegi Nazionaleko Epailearen aurrera lepoko batez eta begi bat ubeldurik zituela agertu zen. Gorputz osoa kolpatu ziotela esan zuen, batez ere burua, barrabilak, bularra eta bizkarra; elektrodo saioak hanketan, oinetan eta barrabiletan; lehertzerainoko flexioak eta "boltsa". Hiru aldiz, gutxienez, itxurazko hilketa saioa egin zuten. Kartzelan, otsailaren 14ean erradiografia bat egin zioten eta bertan saihets©hezur bat hautsirik zeukala ikusten zen.

## 6.GARCIA RODRIGUEZ, PAULA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/2.
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Testigantzan dionez, atxilotu zutenean bere etxeko atea

dinamitatu zuten eta bere seme©alaben aurrean hilko zutela mehatxatu zuten. Komisaldegian elektrodoak jarri zizkioten hanketan, eskuetan eta sabelean; "boltsa" jarri zioten eta buruan oso kolpe handiak jaso zituen. Aho bidezko (ura) droga emate ez-terapeutikoa antzeman daiteke, horrek barre histerikoa eragin zion.

## 7.EGUZKIZA BILBAO, JOSU

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/2/3
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Atxilotu zutenean bere etxeko atea dinamitatu zuten. Gorputz osoa kolpatu zioten eta elektrodo saio ugariz torturatu zuten, lehertzerainoko flexioak egin behar izan zituen eta "boltsa" jarri zioten. Tratu iraingarri eta umiliagarria jasan zuen haien aurrean biluztu eta masturbarazi egin zuten eta bere neskalagunaren (hau ere atxilotua) aurkako mehatxu sexualak etengabe egin zizkioten. Hiru itxurazko hilketa jasan zituen; behin suarma bat jarri zioten ahoan eta balarik gabe tiro egin zuten eta birritan itxurazko urkamenduak egin zizkioten. Ahoz emandako aluzinagarrien bidezko toxikazioaren ondorioz aluzinosis koadroa aurkezten zuen. Eraginak hauek izan ziren: espazio nozioa galtzea, entzun©aluzinazioak, halaber, ez zekien zer zioen eta ez zuen bere neskalaguna ezagutu.

## 8.BLANCO ABAD, ENKARNI

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/2/3
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Atxilotu zutenean etxeko atea dinamitatu zutela dio. Kolpeak jaso zituen, elektrodoak eta "boltsa" jarri zizkioten. Biluztarazi egin zuten bost aldiz eta ernaltze©organoak ikutu zizkioten, bortxatu egingo zutela eta uzkitik makil bat sartuko ziotela esan zioten. Atxiloketak zirauela magina©homorragiak izan zituen.

## 9.AMEZAGA, ITZIAR

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske kargurik gabe, 92/2/2
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Lurrean jipoitu zuten. Belarrietako zoldura zeukan eta hau jakinik, indarren jo zuten bertan eta hiru egunez zoldura sendatzeko behar zuen medikamendua ukatu zioten. Biluztarazi egin zuten eta ahozko laido sexualak jasan zituen, baita fisikoak ere; ukipenak, maginan pistola baten kanoia eta berak zer ziren ez zekien beste gauza batzuk sartu zizkioten. "Boltsa" jarri zioten eta lehertzerainoko flexio saioak egin behar izan zituen. Alabaren zaintza kentzeko mehatxua egin zioten.

## 10.ARRIAGA GOIRIZELAIA, JON

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Aske kargurik gabe, 92/2/2
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Etengabeko irainez eta neskalaguna (atxilotua hau ere) bortxatuko zutelako mehatxupean tratu umiliagarria jasan zuen. Buruan, giltzurrin eta barrabiletan jo zuten batik bat. "Boltsa" ipini zioten eta flexioak eginarazi.

### 11.ELORRIAGA BILBAO, IMANOL

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, lantokian.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Aske kargurik gabe, 92/2/2

Gorputz osoan jo zuten, elektrodoak jarriko zizkiotelako mehatxua egin zioten eta elektrikararen bat ere somatu zuen. Flexioak egitera behartu zuten eta "boltsa" ipini zioten. Neskalagunaren aurkako mehatxuak egin zizkioten.

## 12.SEVILLANO BIDAURRE, ITXASO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, kalean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Aske kargurik gabe, 92/2/2
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

7 hilabeteko haurdunaldiaz eta medikaziorik gabe 24 orduz. Gure elkarteak Habeas Corpus bat eskatu zuen tentsio baxua eta eta proteina dieta baten beharra zeuzkalako eta ukatu egin ziguten. Tratu txar psikologikoak jasan zituen eta umea galduarazi egingo ziotelako mehatxua egin zioten. Buruan kolpeak eman zizkioten eta atzamarrak garondoan sartzen zizkioten.

## 13.BEREZIARTUA GONZALEZ, IÑAKI

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Aske kargurik gabe, 92/2/2
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Atxiloketa unean senitartekoak hormaren kontra jarri eta haiengana zuzendu zituzten armen kanoiak, bera belauniko eduki zuten pistola batez apuntatzen zutelarik. Komisaldegian kolpeak eta elektrodoak jaso zituen eta "boltsa" jarri zioten.

## 14.CACIGAL BECERRIL, PEDRO LUIS

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, etxean.

POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske kargurik gabe, 92/2/2
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Telefono gida batez jo zuten bularrean, urdailean, giltzurrinetan eta batez ere buruan laupabost orduz. Flexioak egitera behartu zuten eta "boltsa" jarri zioten. Hil egingo zutela esan zioten eta bere neskalagunari sexu irainak jasanaraziko zizkiotela. Amak bihotzekoak jo zuela esan zioten.

### 15.ARANZAMENDI ARBULO, JOSE MARÍA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske kargurik gabe, 92/2/2
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Atxiloketa unean, bere gurasoak lepotik hartu zituezten esku batez besteaz zetmearekin apuntatzen zituzten bitartean. Kolpeak eta elektrodoak jasan zituen, flexioak egitera behartu zuten, "boltsa" jarri zioten eta mehatxatu egin zuten. Madrilerako bidean odol txiza egin zuen.

## 16.LARRA GUERRERO, MARÍA ANGELES

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/1, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/2/5
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Testigantzak dioenez, kolpeak eta elektrodoak jasan zituen, "boltsa" jarri zioten eta sexu irainak sufritu behar izan zituen, bularrak ikutu zizkioten eta biluztera behartu, tratu umiliagarria jasan zuen, komunean zegoela atea zabalik edukitzea kasu. Mehatxu eta irainak etengabeak ziren.

## 17.MARIAS MATURANA, JOSE FELIX

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/3, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske epailearen aurrera agertu gabe, 92/2/6

Kolpatu egin zutela dio, elektrodoak jarri zizkiotela hanketan, sorbaldan, besoetan, bizkarrean, barrabiletan eta zakilan. "boltsa" jarri zioten eta flexioak egitera behartu zuten, bere familia eta bere buruaren aurkako mehatxuak egin zizkioten.

### 18.ARANA TXAKARTEGI, ROSA MARÍA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/5, lantokian.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/2/8
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Gorputz osoa kolpatu zioten, lau elektrodo saio jasan zituen eta hauek hanketan, besoetan, bizkarrean, bularrean, ditiburutan, maginan, urdailean eta besapean jarri zizkioten. Flexioak egitera behartu zuten, "boltsa" jarri zioten. Tratu umiliagarria jasan zuen emakumea izateagatik, sartzen zen orori bularrak erakutsi beharra kasu.

## 19.AZPITARTE AIZPURUA, JOSE MARIA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/5, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Aske epailearen aurrera agertu gabe, 92/2/7

Atxiloketa unean pistola batez apuntatu eta semea kolpatu zuten. 60 urteko gizona da, bihotzekoak jasan dituena eta entzuteko sonotonea behar duena. Ez zioten gailurako pilarik eman. La Salveko Koartelean buruan jo zuten eta Madrilerako bidean ez zioten txiza egiten utzi.

## 20.EZKERRA PEREZ DE NANCLARES, MARÍA BEGOÑA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/5, lantokian.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/8
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Buruan eta hanketan jo zuten, elektrodoak jarri zizkioten beso, hanka eta bizkarrean. Ordu luzez jarrera berean egotera eta flexioak egitera behartu zuten. "Boltsa" jarri zioten. Umiliazio sexuala jasan zuen, ditiburuak ikutu zizkioten batez ere eta emakumea izatearen ondoriozko irainak entzun behar izan zituen.

## 21.DAVADILLO, ESTANISLAO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/25, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Aske kargurik gabe, 92/2/29
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.Testigantzan gorputz osoan kolpeak eman eta hormaren kontra kolpatzen zutela dio. Elektrodoak jarri zizkioten eta flexioak egitera behartu zuten. Tortura gehiago egingo zizkiotelako mehatxua egin zioten eta tratu umiliagarria jasan zuen, gerritik behera biluztarazi zuten eta ernaltze-organoak ikutu zizkioten. Semearen heriotzeaz trufatzen ziren.

## 22.GONZALEZ HUIDOBRO, FELIX

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/25, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Aske kargurik gabe, 92/2/29
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Gorputz osoa kolpatu zioten, elektrodoak jarri zizkioten

jantzirik zegoela eta erantzirik zegoela eta "boltsa" ere jarri zioten. Galdaketek zirautela begiak estalirik eduki zituen. Biluztarazi egin zuten eta bere senitartekoen aurkako eta tortura gehiago jasango zituelako mehatxua egin zioten.

## 23.CASANOVA ALONSO, ALEJANDRO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/25, lantokian.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske kargurik gabe, 92/2/29
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Eskuz, ostikoka, telefono gidaz eta porrez kolpatu zuten. Elektrodoak eta "boltsa" jarri zizkioten eta lehertzerainoko flexioak egitera behartu zuten. Hilko zutelako mehatxua egin zioten eta pistola bat jarri zioten ahoan.

## 24.GALARZA QUIRCE, LUIS ANGEL

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/18, kalean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/3/22
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Komisaldegira eraman zuten furgonetan etzanarazi zuten ahoz behera, burua zanpatu zioten eta ostikoak eta ukabilkadak eman zizkioten. Pistola ahoan sartu zioten hiltzen zalantzarik ez zutela izango esanez. Komisaldegian kolpe gehiago eman zizkioten. Elektrodoak eta "boltsa" jarri zizkioten. Flexioak egitera behartu zuten. Atxiloketak iraun zuen bost egunetan begiak estalirik eduki zituen, honek konjuntibitis zolia eragin zion. Mehatxuak etengabeak izan ziren.

## 25.REKARTE IBARRA, IÑAKI

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/18, kalean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/3/22
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Atxiloturik egon zen egun guztietan gorputz osoan jaso zituen kolpeak baina batez ere buruan eta barrabiletan. "Boltsa" jarri zioten eta elektrodoak hanketan, bizkarrean, besoetan, mihian eta barrabiletan. Flexio ugari eginarazi zioten, baita lehenago listua bota zuten baso bat ur edanarazi ere. Inkomunikazioak iraun zuen bost egunetan ez zioten lo egiten utzi, atxiloketaren azken orduetan ezik, orduro ateratzen baitzuten ziegatik galdeketa egiteko. Hilko zutelako mehatxua egin zioten eta bere arrebak eta gurasoak torturatzeko atxilotuko zituztela esan zioten. Uzkitik pistola bat eta porra sartu zizkioten. Behin itxurazko hilketa saioa egin zioten pistola bat buruan jarri eta hil egingo zutela esanez.

## 26.ZAMAKONA ORMAETXE, IDOIA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/18, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/3/22
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Eskuz buruan jo zuten eta hormaren kontra kolpeak eman zizkioten. Pertsona bat gainean zuela flexioak egitera behartu zuten. Umiliazio sexualak jasan behar izan zituen emakumea izateagatik, bortxaketa mehatxuak egin zizkioten, hainbat gizon eta emakumek gorputz osoa ikutu zioten, erratz kirten bat sartu zioten maginan eta haien aurrean masturbatzera behartu zuten. Itxurazko hilketa saioa egin zioten pistola bat ahoan jarriz. Bere senitartekoen aurkako mehatxuak egin zizkioten eta atxiloturik egon zen bitartean espazio eta denbora nozioak galdu zituen etengabeko galdeketen ondorioz besteak beste.

## 27.MORANTE GARCÍA, ANATXO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/18, lantokian.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/3/23
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Buruan kolpeak eman zizkioten eta elektrodoak jarri zizkioten hanketan. Biluzik, bularrak ikutu zizkioten, bere burua masturbatu eta haiek masturbatzera behartu zuten. Maginan pistola bat sartu zioten eta balarik gabe tiro egin. Ziegan, gauez, sarritan joaten zitzaizkion, biluztu eta bizkarra emanez makurtu eta hankak zabaltzera behartzen zuten. Esku edo barrabilez ikutzen zuten. Behin edo behin etzan eta hankak zabaltzera behartu zuten eta atzamarrak maginan sartu zizkioten.

## 28.ALAÑA ARRINDA, RAMÓN

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/18, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/3/23
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Kolpeak buru eta urdailean jaso zituen, "boltsa" jarri zioten eta adats zatiak atera. Denbora luzean jarrera berean egotera behartu zuten eta honek ahitze fisikoa ekarri zion. Behin baino gehiagotan aulki batean eseriarazi zuten, bertan sabairantz altxa eta ondoren bapatean lurrerantz erortzen uzten zuten. Honek izugarrizko bizkarreko mina sortarazi zion.

## 29.NÚÑEZ MARINA, JOKIN

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/18, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/3/22
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Gorputz osoan jaso zituen kolpeak. Goardia Zibilaren Zuzendaritza Nagusian (Madril), jendez beteriko areto batean eta biluzik, elektrodo saio bat ezarri zioten gorputz osoan, barrabilak ikutu zizkioten, umiliazio eta irainak jasan behar izan zituen. "Zakurrarena" egitera behartu zuten ostikoak jo eta elektrodoak jartzen zizkioten bitartean. Denbora luzean jarrera berean egon eta flexioak egitera behartu zuten, eta "boltsa" jarri zioten. Ura drogaturik zegoela ere pentsatu zuen, edan ondoren bere onetik kanpo baitzegoen eta ez baitzituen inola ere bere ekintzak koordinatzen. Denbora nozioa galdu zuen janaria eramaten ziotenean batek afaria eta besteak gosaria zela esaten ziolako.

## 30.GARCIA GOMEZ, DAVID

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/21, kalean.
POLIZI TALDEA.................. Polizia Nazionala.
ONDORIOA...................... Aske fidantzapean, 92/3/24
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Eskuz eta ostikoka jo zuten eta bultza egiten zuten. Adats zatiak atera zizkioten eta ahozko umiliazio eta irainak sufriarazi. Tortura gehiago jasanaraziko ziotela esan zioten eta Madrilerako bidean kotxetik behera botako zutela. Denbora nozioa galdu zuen janarien ordutegia aldatu egiten ziotelako.

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/10/27, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA...................... Kartzela, 92/10/29
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Bere Abokatuak, Arantza Zuluetak esan zigun atxilotuak Baltasar Garzon Epailearen aurrean egindako adierazpenean, nabarmenki ukiturik, torturak eta tratu txarrak sufritu zituela esan zuela. Gorputz osoa kolpatu zioten, batez ere burua eta ernaltze-organoak, "boltsa" ezarri zioten une askotan itodura sortaraziz.

## 31.DIEZ TORRE, FERNANDO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/21, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Polizia Nazionala.
ONDORIOA...................... Kartzela, 92/3/26
ADIERAZPENAK EGITEARI UKO EGIN ZION.

Etxean kolpatu zuten eta plastikozko lokarri batzuk jarri zizkioten esposatzeko, honek eskuturretan zauriak eragin zizkion eskuak sentikortasunik gabe utziz. Bere jertseaz itodura sortarazten zioten. Komisaldegian kolpe gehiago eman zizkioten. Tarragonako Ospitale batera eraman zuten, Larrialdietara eraman behar izan zuten oso gaizki zegoelako. Medikuek behaketarako gelditzea nahi zuten baina poliziek uko egin zioten honi eta gerta zitekeenaren aurrean medikuei erantzunkizun guztia kentzen zion paper bat sinatu zuten.

## 32.ANTOLIN ALVAREZ, FRANCISCO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/23, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/3/25
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Gorputz osoan jo zuten, batez ere gerrialdean hemen orno zapaldura baitauka. Elektrodoak eta "boltsa" jarri zizkioten eta bere senitartekoen aurkako mehatxuak egin zizkioten.

## 33.TXINTXURRETA DIEZ, IÑIGO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/23, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/3/25
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Testigantzan dionez, kolpeak eman zizkioten eta hormaren kontra jo. Elektrodoak jarri zizkioten beso eta hanketan, bizkarrean eta giltzurrinetan. "Boltsarena" egin zioten eta senitartekoen aurkako mehatxuak egin zizkioten.

## 34.MACARRON FUERTES, JORGE

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/30, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/4/2
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Gorputz osoan jaso zituen kolpeak, eskuz, ukabilez, ostikoka, makilez eta telefono gidaz. Ilea atera zioten. Denbora luzean egon behar izan zuen hormaren kontra zutik eta flexioak egitera behartu zuten, honek ahitze fisikoa eragin zion. "Boltsa" jarri zioten eta tortura mota gehiago egingo ziotelako mehatxua egin zioten karkaisaz betetako bainuontzia erakusten ziotelarik.

## 35.SANCHEZ GARCIA, LAGUNDU

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/30, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Aske epailearen aurrera agertu gabe, 92/3/31

Buruan etengabe jo zuten konortea galdu eta lurrera erori zen arte. Umiliazio sexualak jasan zituen, biluztu egin zuten eta erantzirik haientzako dantza egitera behartu zuten, ikutu egin zuten eta mehatxatu.

## 36.IRIARTE SANTACOLOMA, ANA ISABEL

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/30, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/4/2
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Atxiloketaren unean geletan zegoen jende guztia aterarazi zuten pistolaz apuntatuz eta irainka. Komisaldegian gorputz osoan jo zuten, batez ere buruan eta ileetatik tira egin zioten. Biluztarazi egin zuten eta gorputz osoa ikutu zioten. Antzu utziko zutelako mehatxua egin zioten. Begietan jarri zioten bendak eskuineko begian konjuntibitisa eragin zion.

## 37.ALDEA DOMINGUEZ, LUIS MANUEL

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/30, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/4/2
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Testigantzan kontatzen duenez, makurturik eduki zuten denbora luzez eta gorputz osoan jo zuten. "Boltsa" jarri zioten. Bere senitartekoen aurkako mehatxuak egin zizkioten eta biluzik egotera behartu zuten.

## 38.DEL CERRO CASAÑES, JOSE ANTONIO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/4/1, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/4/2
Aske 500.000 pta.ko fidantzapean, 92/4/30
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Flexioak egitera behartu zuten eta altxatzeko ileetatik tiratzen zioten. Hormaren kontra kolpatu zuten. Umiliazio sexualak sufritu zituen eta uzkitik pistola bat sartu zioten, laztandu eta musukatu egiten zuten. Itxurazko hilketa biziarazi zioten pistola bat ahoan sartu eta tiro eginez. Senitartekoen aurkako mehatxuak egin zizkioten eta ez zioten egun oso batez txiza egiten utzi.

## 39.PRATS GARCIA, JOSU

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/4/1, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/4/4
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Zer zen ez dakien tresna batez jo zuten buruan. Flexioak egitera behartu zuten eta itodura sortarazi zioten "boltsa" eta "bainuontziarena" eginez. Biluzik zegoela, umiliazioak eragin zizkioten. Eskutan pistola bat hartzera behartu zuten horrela bere hatz©markak zituztela esanez, eta ondoren tiro egitera behartu nahi izan zuten.

## 40.UGALDE ROJO, DIONE

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/4/1, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/4/4

Aske 500.000 pta.ko
fidantzapean, 92/4/30
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Buruan jo zuten eta ileetatik hartuta iharrausi egin zuten, ondorioz ile ugari galdu zuen. Ahitze fisikoa eragin zion jarrera berean denbora luzez egon eta flexioak egin beharrak. "Boltsa" eta "bainuontziarena" egin zioten. Tratua umiliagarria izan zen, iraindu egiten zuten eta bere gorputza arbuiatu.

## 41.URIARTE ZABALA, JOSE IGNACIO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/4/2, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/4/4
Aske 500.000 pta.ko fidantzapean, 92/4/30
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Mehatxu eta irainak jasan zituen. Jarrera berean egon eta flexioak egitera behartu zuten ahitze fisikoraino. Kolpeak, eskaileretatik behera bultza, lurraren kontra jo... Honez gain ile eta biboteetatik tiratzen zioten. "Boltsaz" itodura sortarazi zioten, aho eta sudurra estali eta haietako bat gainean eseri baitzitzaion.

## 42.ZABALA ETXEGARAIA, FRANCISCO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/4/2, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/4/4
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Etxetik kamiseta eta gantzontzilotan atera zuten bultzaka, mehatxuka eta esposaturik. 10 diptriako miopia dauka eta ez zioten betaurrekoak hartzen utzi. Komisaldegian jo egin zuten, elektrodoak jarri zizkioten, gero eta indar handiagoz, ileetatik tira egin zioten eta flexioak egitera behartu, itodura sortarazi zioten "bainuontzia" eta "boltsa" ezarriz.

## 43.ROLLAN RODRIGUEZ, JON

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/9, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/5/13
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Atxiloketa unean arma baten kanoia zuzendu zioten, lurrera bota zuten bizkarra eta burua zanpatzen ziotela, aldi berean ileetatik tira egiten zioten. Madrilerako bideak 11 ordu iraun zituen eta ezin izan zuen denbora horretan komunera joan. Komisaldegian gorputz osoan jo zuten, ileetatik tira eta "boltsa" eta "bainuontziaz" itodura sortarazi zioten.

## 44.ROLLAN RODRIGUEZ, FRANCISCO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/9, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/5/13
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Atxiloketa unean lurrera bota zuten joka eta arma batez apuntatuz bertan tiro egingo ziotela esanez. Koartelean "boltsa" jarri zioten jo eta barrabiletatik tiratzen zioten bitartean. "Bainuontziarena" ere egin zioten. Mehatxu ugari egin zizkioten.

## 45.OLANO ARBELAITZ, ANSELMO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/9, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/5/13
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Etxean belauniko jarri zuten hormaren kontra, bitartean ostikoak jo zizkioten eta cetme batez apuntatzen zuten hilko zutela esanez. Koartelean kolpeak eman zizkioten eta "bainuontzia" eta "boltsa" ezarri. Madrilerako bideak 11 bat ordu iraun zituen, esposaturik eta lurrera begira makurturik joan zen.

## 46.VALDERRAMA IGLESIAS, VICTOR

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/9, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/5/13
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Atxilotu zutenean lurrean etzanarazi zuten eskuak garondoan zituela, ileetatik tira egin zioten, ostikoak jo, zanpatu eta arma batez apuntatu. Armak zauri bat eragin zion bizkarrean eta geroago komisaldegian jotzen zutenean zauri honek min jasangaitza eragiten zion. Intxaurrondoko koartelean "boltsa" ezarri zioten jotzen zuten bitartean. Madrilen berriro jarri zioten "boltsa" eta "bainuontziarena" egin zioten, mehatxatu egin zuten.

## 47.CABEZA BLANCO, ALBERTO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/9, kalean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/5/13
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Atxilotu zutenean identifikatu ez ziren kalez jantzitako pertsona batzuek pistola batez apuntatzen zutela dio. Galdaketetan eta ziegan bertan jipoitu egin zuten. "Bainuontziarena" egin zioten eta neskalagunari bere aurrean gauza bera egingo ziotelako mehatxua egin zioten.

## 48.CUESTA TRULA, RODOLFO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/9, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/5/13
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Bere etxean sartzeko atea bota zuten eta bera ohetik atera zuten ostiko eta zapalaldien artean kamiseta apurtu ziotelarik. Intxaurrondoko koarteletik Madrilerako bideak 11 ordutik gora iraun zuen, eta 19 egun geroago oraindik ere saihetsean mina zeukan denbora guzti hartan esposaturik eta burua makurturik egon behar izan zuelako. Galdaketetan jo egin zuten, "boltsa" ezarri zioten eta mehatxatu egin zuten.

## 49.SANCHEZ DEL ARCO, ANGEL ANDRES

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/9, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/5/13
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

La Salveko koartelean kolpatu eta iraindu egin zuten. Madrilera eramateko atera zutenean begiak estalirik zeramatzan eta bultza egin zuten, ondorioz sudurraz kotxe baten atea jo zuen. Madrilen kolpatu eta mehatxatu egin zuten.

## 50.CABEZA BLANCO, ELEUTERIO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/13, Epaitegi Nazionaleko atearen aurrean (Madril).
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/5/17
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Madrilgo Goardia Zibilaren Zuzendaritza Nagusian jo egin zuten, 3. galdeketan "bainuontziarena" egin zioten eta ukabilez giltzurrin eta urdailean jo zuten.

## 51.GASTESI SIERRA, PAKO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/13, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/5/17
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Donostiako Antiguoko koartelean boltsa eta elektrodoak jarri zizkioten eta jo egin zuten. Madrilen egindako galdeketak mehatxu artean, "bainuontzi", "boltsa", elektrodoak jarriz, kolpeak emanez, ileetatik tiraka, e.a. egin ziren. Epaitegi Nazionalera agertu zenean maiatzaren 17ko gauean, aurpegia guztiz ubeldurik zeukan; bere abokatuak, Begoá¤áa Lalanak xehetasun hori aktan agertzen zenentz galdetu zuen baina ez zioten erantzun, ondorioz, hurrengo egunean, hilak 18, Gau eta Eguneko Epaitegian salaketa aurkeztu zuen.

## 52.AGIRREZABALA UGALDEBERE, KARMELE

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/12, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/5/17
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Kolpatu egin zuten eta galdeketa guztietan mehatxatu. Epaitegi Nazionalera eraman aurretik goardia zibil bat beraren ziegara joan zitzaion, biluztu eta biraka ibiltzera behartu zuen.

## 53.ELIZALDE GOIENETXE, JUAN BAUTISTA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/13, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/5/17
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Kolpatu egin zuten, flexioak egitera behartu zuten, "boltsa" jarri zioten behin baino gehiagotan eta elektrodoak ezarri zizkioten. Emaztea berarengana hurbildu zuten haren oihuak eta baketan utz zezaten eskatzen entzun zuen. Bitartean berari emaztea torturatuko zutelako mehatxuak egin zizkioten.

## 54.BALERDI ETXEBESTE, MARÍA CARMEN

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/13, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/5/17
Aske 1.500.000 pta.ko
fidantzapean, 92/11/14

Madrilen galdeketak luze eta etengabeak izan ziren, ileetatik tiraka eta mehatxuka. Ziegatik ateratzen zutenean burua makurturik lurrera begira egon behar izaten zuen. Ia denbora guztian zutik egotera behartu zuten.

## 55.GONZALEZ SOLANA, XABIER

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/9/24, kalean.
POLIZI TALDEA.................. Ertzaintza
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/9/25
Aske, 92/10/14
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Bilboko Má¦á Diaz de Haroko komisaldegian ezin izan zuen lorik egin ate joka eta oihuka ibili zirelako. Galdeketak etengabeak izan ziren eta mehatxu eta irain ugari jasan behar izan zuen. Martuteneko (Gipuzkoa) kartzelarako bidean (Goardia Zibilak Egina) kolpeak eta zimikoak jaso zituen gorputz osoan. Bidaian furgonetatik aterarazi zuten eta goardia zibil batek hil nahi zuelako itxurak egin zituen. Kartzelan ordu txikitan arakatu zuten ohetik kolpeka atera eta biluztarazi ondoren. Behin

funtzionari bat ziegara joan zitzaion eta jo egin zuen.

## 56.URUBURU IRAZABAL, IÑAKI

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/10/22, kalean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske, 92/10/22

Testigantzan dionez, ez zuen kalte fisikorik jasan baina tratua "tratu txartzat" har zitekeen.

## 57.GARCIA ELIZ, SANTIAGO

92/10/27an salaketa aurkeztu zuen Bilboko Argibideetarako 10. Epaitegian David Garcia bere semearen atxiloketan jasandako tratu txarrak zirela eta. Salaketan adierazten denez, egitateak egun horretako goizaldeko 01:00etan hasi ziren: etxean 10 edo 12 bat goardia zibil sartu ziren, hauek inolako azalpenik eman gabe lepotik hartu eta pistola ahoan sartu zioten. Aipatu tratu txarren ondorioz eskuineko besoan eskimosis bat sortu zitzaion, hau auzitarako medikuak egiaztatu zuen.

## 58.AMAS CUBAS, URKO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/15, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske kargurik gabe, 92/12/19

Gorputz osoan jo zuten, batez ere buruan. Denbora luzez zutik egotera behartu zuten, hormari begira, burua makurturik eta begiak itxirik. "Bainuontziarena" egin zioten. Galdeketak eta mehatxuak etengabeak izan ziren.

## 59.ARENAS ASES, OSKAR

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/16, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske 200.000 pta.ko fidantzapean, 92/12/19

Barrabiletan, buruan, lepoan eta giltzurrinetan jo zuten. Behin zigarro piztu bat jarri zioten begi ondoan eta barrabiletan jotzen zuten mugituz gero erre zedin. Irainak eta bortxaketa mehatxuak, bera zein bere familiaren aurkakoak, etengabeak izan ziren.

## 60.EGIDAZU GARALLONDO, HARITZ

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/16, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/12/20

Buruan eta urdailean jaso zituen kolpeak, ileetatik tira egiten zioten. "Boltsa" eta "bainuontziarena" egin zizkioten. Galdeketak etengabeak izan ziren eta familiaren aurkako mehatxuak egin zizkioten.

## 61.ETXEBARRIA MAYO, JUAN IGNACIO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/19, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske epailearen aurrera agertu gabe, 92/12/21

"Bainuontziarena" egiten zioten bitartean jo egin zuten eta elektrodoak ezarri, "boltsa" ere ipini zioten. Galdeketak etengabeak izan ziren eta zenbaitetan biluzik egotera behartzen zuten. Mehatxatu egin zuten, eta behin pistola bat eskutan hartzera behartu zuten horrela zulo batean aurkitutako pistola batean bere hatz markak zituztela esanez.

## 62.TOLOSA GONZALEZ, JOKIN

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/19, kalean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske epailearen aurrera agertu gabe, 92/12/20

Donostiako Antiguoko koartelean garondoan jo zuten eta luzaroan zutik hormari begira egotera behartu zuten. Alaben argazkiak ikusirik trufatu egiten ziren, anaiaren heriotzeaz ere barre egiten zuten, eta emazteaz hitz egiten ziotenean "puta" deitzen zioten.

## 63.GANUZA, MIKEL

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/20, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske 500.000 pta.ko fidantzapean, 92/12/23
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Atxiloketa indarkeria handikoa izan zen. Arreba pistola batez eta ostikoka jo zuten eta aita lurrera bota zuten. Joana Ganuzak epai salaketa bat aurkeztu zuen kolpeen berri jasotzen zuen mediku txosten batean oinarriturik.
Koartelean kolpeak eta mehatxu ugari jaso zituen. Madrilen birritan jarri zioten pistola ahoan hil egingo zutela esanez.

## 64.LOITI, IKER

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/20, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske 500.000 pta.ko fidantzapean, 92/12/23

Etxetik koartelerako bidean buruan jo zuten eta odoljario bat eragin zioten begian. Eibarren hiru orduz egon zen eta bertan jo egin zuten, batez ere buruan. Madrilen "boltsa" jarri zioten, jo eta mehatxatu egin zuten.

## 65.ARZELAI, ASIER

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/20, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Aske 200.000 pta.ko fidantzapean, 92/12/23
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Etxetik Eibarreko koartelerako bidean batez ere buruan jo zuten eta armaz kolperen bat edo beste. Koartelean kolpeak eta mehatxu ugari jasan zituen.

## 66.ALTZIBAR BELOKI, JON ANDONI

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/20, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Aske epailearen aurrera agertu gabe.

Galdeketak etengabeak izan ziren, buruan eta lepoan jo zuten. Madrilerako bidean saihesbide bat hartu zuten, ibaiertz baten gelditu ziren eta han "bainuontziarena" egitearekin mehatxatu zuten. Ondoren hil egingo zutela esan zioten, korrika egitera behartu zuten baina atxilotuak uko egin zion honi.

# ABOKATUEN BIDEZ JAKINDAKO TORTURA KASUAK

## 67.LABURU LANDETA, EKAIN

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/10, etxean
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/1/11

Epaitegi Nazionalean ez zuen tortura salaketarik egin baina Abokatuari jasan zituen torturak kontatu zizkion, haien artean "boltsa"rena.

## 68.LANDETA, ARANTZA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/10, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/1/11
Aske 100.000 pta.ko fidantzapean, 92/4/10

Epaitegi Nazionaleko Epailearen aurreko adierazpenetan ez zuen torturarik salatu baina geroago inkomunikaturik egon zenean torturatu egin zutela esan zion Abokatuari, "boltsa"rena egin zioten besteak beste.

## 69.PALACIOS CAPITAN, FRANCISCO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/2
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Abokatuek ez zituzten jasandako torturak zein izan ziren zehaztu.

## 70.BRINGAS PEREZ, JOSEBA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/3, kalean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/6
ADIERAZPENAK EGITEARI UKO EGIN ZION.

Epaitegi Nazionalean izan ondoren, Joseba Bringasek atxilotua egon zen denboran torturatu egin zutela esan zien abokatuei.

## 71.IRIONDO MARIABARRENA, PEIO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/22, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/24

Carmen Galdeano bere abokatuaren bidez jakin ahal izan dugunez atxilotua egon zen denboran kolpatu egin zuten, flexioak egitera behartu zuten eta pistola bat jarri zioten buruan.

## 72.VILLASANTE ARZA, GARBIÑE

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/9, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/5/13
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Ez dakigu zehazki zein izan ziren jasandako torturak.

## 73.CUERDO RODRIGUEZ, JOSE FERNANDO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/9, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/5/13
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Ez ziren jasan zituen torturak zehaztu.

## 74.INZIARTE GALLARDO, JOSE ANTONIO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/13, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/5/17
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Arantza Zulueta Abokatuak, bere defendatuak torturak jasan zituela adierazi zuen. Jo egin zuten eta "bainuontziarena" egin zioten eta horren ondorioz Madrilgo Ospitale Klinikora eraman behar izan zuten 92ko maiatzaren 5ean. Ospitalea hurrengo egunean atera eta Carabanchelgo Kartzela Ospitalera eraman zuten eta bertan inkomunikatu.

## 75.BRIT OLLOKIEGI, AITOR

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/3, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske kargurik gabe.
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Abokatuak esan zuenez, Baltasar Garzon Epailearen titularitzapean dagoen Epaitegi Nazionaleko Argibideetarako 5. Epaitegi Zentralean gorputz osoan jo zutela eta itodura sortaraziz "boltsa" ezarri ziotela adierazi zuen.

## 76.EZKURRA, CARLOS

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/16, etxean
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/6/20 EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Bere Abokatuak, Txemi Gorostizak, Ismael Moreno Epailearen titularitzapean dagoen Argibideetarako 2. Epaitegi Zentralean egindako tortura adierazpena berretsi zigun. Atxiloketa unean eraso egin ziotela adierazi zuen, boltsa ezarri ziotela eta gorputz osoan jo zutela. Torturaren arrasto nabarmenak zeuzkala adierazi zuen Abokatuak, ezkerreko begia ubeldurik eta aurpegia handiturik, horiturik baitzeuzkan.

Arrebak Carabancheleko kartzelan bisitatu zuen 92/6/25ean eta atxilotuak oraindik begian ubeldura handia zeukala ikusi ahal izan zuen.

## 77.REY DOMENECQ, ALBERTO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/10/22, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/6/20
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Bere Abokatuak baieztatu zigunez, Baltasar Garzon Epailearen

aurrean egindako adierazpenean Goardia Zibilaren egoitzan tratu txarrak jasan zituela salatu zuen, zein izan ziren adierazi gabe.

## 78.ALBARRAN COBOS, VICENTE

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/10/22, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/10/26
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Epailearen aurrean tratu txarrak jasan zituela eta ipur masailetan, barrabiletan eta bizkarrean elektrodoak jarri zizkiotela esan zuen. Abokatuak, Jone Goirizelaiak kamisetak agerian uzten duen bizkar zatian mantxa gorriak zeudela ikusi zuen.

## 79.VELEZ SUBERBIOLA, SUSANA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/10/22, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/10/26
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Abokatuak esan zigunez, Garzon Epailearen aurrean 92/10/26an egindako adierazpenean inkomunikaturik egon zen lehenengo bi egunetan gorputz osoa kolpatu eta ileetatik tiraka torturatu zutela eta ondorengo egunetan presio psikologiko gogorrez torturatu zutela esan zuen.

## 80.DURANA URTIAGA, RAMON

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/10/22, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/10/26
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Epailearen aurrean esan zuenez, begietan ikusmena eragozten zion benda bat zeukala egon zen polizi egoitzan, lehertzerainoko flexioak egin behar izan zituen, gorputz osoa kolpatu zioten batez ere burua, eta elektrodoak aplikatu zizkioten.

## 81.ORTIZ DE ETXEBARRIA MAGALLON, GORKA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/10/26, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/10/29
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Atxiloketa oso bortitza izan zen, aitak eramaten zutenean nola jotzen zuten ikusi zuen. Bere burua erruztatzeko adierazpen bat egin zezan derrigortu zutela adierazi zuen Baltasar Garzon Epailearen aurrean, ukatzekotan zer gerta zekiokeen ikus zezan elektrodoak ezarri zizkioten mihian.

# PRENTSA BIDEZ JAKINDAKO TORTURA KASUAK

## 82.BELAUSTEGI CUESTA, ELISABETH

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/6, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/1/10
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/1/11
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Intxaurrondoko koartelean elektrodoak jarri zizkiotela eta Madrilen zein Donostian jo egin zutela salatu zuen.

## 83.IRIARTE PEREZ, JUAN CARLOS

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/6, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/1/10
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/1/11
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Madrilen eta Donostian jo egin zutela salatu zuen.

## 84.LASO SANCHEZ, FRANCISCO JAVIER

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/6, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/1/10
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/1/11
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Madrilen eta Donostian jo egin zutela salatu zuen.

## 85.J.L.K., G.B.G., A.A.G.

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/27, taberna batean.
POLIZI TALDEA................... Ertzaintza.
ONDORIOA........................ Aske, 92/1/28
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. El Correo Espaá¤áol 92/1/30
EPAILEAREN AURREAN TRATU TXARRAK ETA KALTEAK SALATU ZITUZTEN.

Biktimek aipatutako egitateak hauexek izan ziren: taberna batean zeudela, tabernariek deiturik zenbait Ertzain agertu ziren. Atxiloketa minutu batzuz baino ez zen luzatu, denbora honetan bultzakadak eta ahozko mehatxuak izan ziren eta hauek kanpoan kolpe bilakatu ziren. Kalez jantzitako ertzain batek pistola atera eta J.L.K. jo zuen buruan zauri bat eraginez. G.B.G.ri lokian porra batek eragindako zauria josi behar izan zioten.

Gainerako kalteak beso, bizkar eta hanketako ubeldurak izan ziren. (Bizkaia) Getxoko komisaldegira eraman zituzten eta ordu bete geroago Basurtuko Ospitale Zibilera, bertako medikuek behaketarako gelditzea nahi zuten baina ertzainek ez zieten utzi.

## 86.TOBALINA RODRIGUEZ, JUANTXU

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/2
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/1/31

Prentsaurrean honen semeak, David Tobalinak, goizaldeko 04:00etan atea dinamitatzeak sortarazitako leherketa handi batek esnatu zituela esan zuen. David, bere anaia eta ama gela batean itxi zituzten. Ondoren aita negarrez entzun ahal izan zuen.

## 87.OLABARRIA BURON, AITOR

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/2
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/1/30

Gaztearen gelaraino heltzeko senitarteko bat ezkutu gisa erabili zuten.

## 88.ARRIAGA GOIRIZELAIA, AITOR

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/29, lantokian.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/2
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/2/3
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Ez da zehazten torturak zein izan ziren.

## 89.GOROSTIZA LEJARRIAGA, JOSE JAVIER

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/1/31, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/5
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/2/6
Egin, 92/2/11
Egunkaria 92/2/11
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Bere Abokatua den Jone Goirizelaiaren esanetan, Epaitegi Nazionaletik igarotzean fisikoki itxura penagarria zeukan; irain ugari jasan zituen, gorputz osoa kolpatu zioten eta galdaketetan biluzik egon behar izan zuen.

## 90.DE PAUL LARREA, ALBERTO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/1, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/5
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egunkaria, 92/2/11
Egin, 92/2/11
El Mundo, 92/2/11
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Bere amari (María Angeles Larrea) emandako tratua ikustarazi zioten.

## 91.ONAINDIA ZUBIETA, MIREN JOSUNE

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/2, kalean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/6
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/2/7
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Berrian ez da zehazten jasandako torturei buruz atxilotuak egindako adierazpenik.

## 92.ZUGADI GARCIA, IÑAKI

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/2, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/6
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/2/11
Egunkaria, 92/2/11
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Presio psikologiko gogorrak jasanarazi zizkioten. Abokatuak zer nolako presio psikologikoak izan ziren galdetu zionean ezin izan zuen erantzun, negarrari eman zion gogor jo zutela esanez.

## 93.MONZO GOIKOLEA, PEDRO MARIA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/6, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/8
Aske fiantzapean, 92/5/6
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/2/11
Egunkaria, 92/2/11
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Erdi zorabiaturik uzten zuen gauza gogor batez buruan kolpe asko jaso zituen, baita jipoi ugari ere.

## 94.CASAS NUÑEZ, IGOR

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/25, lantokian.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/29

EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/2/29
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Epaitegi Nazionalean eta Ismael Moreno Epailearen aurrean atxiloturik eduki zuten egunetan tratu txarrak jasan zituela salatu zuen. Egunkarian ez da zehazten zein tratu txar izan ziren.

## 95.ZUMARRAGA CASAS, UNAI

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/2/25, lantokian.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/2/29
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/2/29
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Ismael Moreno Epailearen aurrean inkomunikaturik eduki zuten denboran tratu txarrak jasan zituela salatu zuen. Egin egunkarian jasotako berrian ez dira tratu horiek zehazten.

## 96.LARRINAGA MARTIN, JULEN

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/19, kalean.
POLIZI TALDEA................... Polizia Nazionala.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/3/24
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/3/25
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Carlos Bueren Epailearen titularitzapean dagoen Epaitegi Nazionaleko Argibidetarako 1. Epaitegi Zentralean egindako adierazpenean (Bilbo) Indautxuko komisaldegian torturatu egin zutela esan zuen. Salaketa gorputz osoan zehar jasotako kolpeetan oinarritu zuen.

## 97.LARRINAGA MARTIN, GAIZKA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/19, kalean.
POLIZI TALDEA................... Polizia Nazionala.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/3/24
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/3/25
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Madrilgo Epaitegi Nazionaleko Argibidetarako 1. Epaitegi Zentralaren titular den Carlos Bueren Epailearen aurrean (Bilbo) Indautxuko komisaldegian torturatu egin zutela salatu zuen. Gaizka Larrinaga Auzitarako Medikuak aztertu zuen, eta atxilotua bera izan zen Epaileari medikuaren urgazpena eskatu ziona, egin zizkioten zimiko eta jasotako kolpeen ondorioz besoak markaz beterik baitzeuzkan.

## 98.TREVIÑO AGIRREBARRENA, JOSE RAMON

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/25, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.

ONDORIOA....................... Kartzela, 92/3/27
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/7/9
Egin, 92/7/22
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Ismael Moreno Epailearen aurrean bere atxiloketa "bizitzako esperientziarik latzena" izan zela esan zuen, galdeketak "izugarriak" zirela eta tratua "apaiz izateagatik irainak, mehatxuak eta kolpe ugari buruan" jaso zituela.

## 99.FUENTES REIZABAL, MIREN JASONE

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/30, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/4/2
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/4/3
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Epaitegi Nazionaleko Argibideetarako 4. Epaitegi Zentralaren titularra den Carlos Divar Epailearen aurrean buruan jo zutela, polizi egoitzan egon zen denbora guztian burua estalirik eduki zuela, "boltsa" ezarri ziotela eta etengabeko galdeketak egin zizkiotela salatu zuen.

## 100.PIKABEA, J.

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/3/31, taberna batean.
POLIZI TALDEA.................. Ertzaintza.
ONDORIOA....................... Aske, 92/4/1
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/4/3

J. Pikabea Lezoko taberna batean atxilotu zuten Ertzainek, hauek bapatean eta barruan zeudenak joka bertan sartu zirenean. Atxilotuak berak eta bertan zeuden lekukoek esandakoaren arabera, gaztea "herrestan eta konorterik gabe ehun bat metrora zegoen furgoneta batera eraman zuten". Ondoren Oreretako komisaldegira eraman zuten, bertan polizi fitxa bat egin zioten eta Auzitarako Mediku batek aztertu zuen. Medikuaren txostenaren arabera, atxilotuak makadura, ubeldurak eta erosioak zeuzkan eskuineko ukondoan, besoan, sorbaldan eta ezkerreko eskapulan, aldaka bietan eta belaunetan, eskuineko izterrean eta makadurak bizkarrean.

## 101.URRA FERNANDEZ, TXEMI

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/13, Epaitegi Nazionalaren atean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/5/17
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/5/19
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Baltasar Garzon Epailearen aurrean egindako adierazpenean buruan kolpeak emanez torturatu zutela esan zuen.

## 102.LARRINAGA MARTIN, IBON

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/17, kalean.
POLIZI TALDEA................... Ertzaintza.
ONDORIOA........................ Aske, 92/5/19
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/5/20

Atxilotuaren esanetan, esposatu aurretik lurrean jipoitu egin zuten eta herrestan eraman. Ubeldura ugari zeuzkan eta gorputzaren hainbat lekutan zauriak. Hau zela eta salaketa aurkeztu zuen.

## 103.A.B. AKAITZ

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/5/17, kalean.
POLIZI TALDEA................... Ertzaintza.
ONDORIOA........................ Aske, 92/5/17
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/5/22

Erasotuak, adin txikikoa, epai salaketa bat aurkeztu zuen eta bertan hauxe dio: "kaletik nenbilen eta jendea korrika ikusi nuenean ni neu ere korrika hasi eta lurrera erori nintzen". Lurrean zegoela Ertzainek jo egin zuten gorputz osoan (mediku txostenak adierazten duen bezalaxe) eta buruan. Ordiziko Ertzaintzaren egoitzara eraman zuten eta bertan ez zitzaion mediku urgazpenik eskaini.

## 104.LAKASTA PEREZ DE LIZARBE, ESTER

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/16, lantokian.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/6/20
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egunkaria, 92/6/21
Egin, 92/6/21
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Ismael Moreno Epailearen aurrean malkoak zerizkiola mehatxu eta oso presio psikologiko gogorrak sufritu zituela adierazi zuen, kolperen bat edo beste eta polizi egoitzan eduki zuten denbora guztian ez ziotela lorik egiten utzi.

## 105.ARTZE, PATXI

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/16, kalean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/6/20
Aske, 92/7/1
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egunkaria, 92/6/21
Egin, 92/6/21
Egin, 92/7/3
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Epaitegi Nazionaleko Argibideetarako 2. Epaitegi Zentralaren titularra den Ismael Moreno Epailearen aurrean egindako adierazpenean egozten zitzaizkion kargu guztiak ukatu zituen eta

Goardia Zibilaren egoitzan jasandako tratu txarrak azaldu zituen. Buruan, lepoan eta barrabiletako kolpeez eta "boltsa" eginez torturatu zutela adierazi zuen. Leporatzen zitzaiona onartzeari uko egin zion, polizi egoitzatik Ofiziozko Abokatua joan ondoren tratu txarrak areagotu egin ziren.

## 106.BERASTEGI MIGUEL, ANGEL

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/16, lantokian.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/6/20
Aske, 92/7/1
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/6/17
Egin, 92/6/18
Egunkaria, 92/6/21
Egin, 92/6/21
Egin, 92/7/3
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Senitartekoak kezkaturik zeuden atxilotuaren osasun egoeragatik, bi koma diabetiko jasan dituen gaisoa baita. Hori dela eta, atxiloketa egunean bertan Goardia Zibilaren koartelera gaisotasunaren tratamendurako beharrezko medikamentuak eraman zituzten. Eramandako paketea hurrengo egunean bere horretan itzuli zieten.

Epaitegi Nazionaleko Argibideetarako 2. Epaitegi Zentralean polizi egoitzan gorputz osoa kolpatuz torturatu egin zutela salatu zuen.

## 107.GARIN LASERAS, ENRIQUE

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/16, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske kargurik gabe, 92/6/20
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/6/21
Egin, 92/6/22
Egin, 92/6/27
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Prentsaurrean azaldu zuenez "boltsa"rena etengabe egin zioten: "hirutan kontrakzioak eduki nituen, horrez gain flexioak egitera behartu eta jo egiten ninduten "bainunontziarena" egin eta elektrodoak ezarriko zizkidatelako mehatxupean".

## 108.ARAÑA, JOSE MANUEL

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/16, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Aske kargurik gabe, 92/6/20
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egunkaria, 92/6/21
Egin, 92/6/21
Egin, 92/6/27
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Bi egunkari hauetan ez dira jasan zituen torturak zehazten,

azaltzen den gauza bakarra Ismael Moreno Epailearen aurrean inkomunikaturik eduki zuten lau egunetan tratu txarrak jasan izana salatu zuela da.

## 109.FLORES, KOLDO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/16,
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Aske kargurik gabe, 92/6/20
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egunkaria, 92/6/21
Egin, 92/6/21
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Ismael Moreno Epailearen aurrean inkomunikaturik egon zela tratu txarrak jasan zituela salatu zuen. Aipatu egunkarietan ez dira tratu txar horiek zehazten.

## 110.ORTIZ EGIZABAL, AURKENE

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/16, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Aske kargurik gabe, 92/6/20
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/6/21
Egunkaria, 92/6/21
Egin, 92/6/22
Egin, 92/6/27
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.
Komisaldegian jasandako torturak kontatzen ditu, emakume izateagatik jasandako tratu iraingarria azpimarratuz. Kolpatu eta mehatxatu egin zutela adierazten du. Burdinezko barra bat erakusten zioten eta harekin egin zitekeen guztia, baita maginan sartzea ere, esaten zioten. Ia denbora guztian ilunpetan edo begiak estalirik zituela eduki zuten.

## 111.ARANGUREN OLANO, JESUS MARIA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/17, etxean.
POLIZI TALDEA................... Polizia Nazionala.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/6/20
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egunkaria, 92/6/21
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Epaitegi Nazionalean Ismael Moreno Epailearen aurrean, jasandako tratu txarren berri eman zuen. Egunkarian ez dira tratu txarrak zehazten.

## 112.EGAÑA ZUMETA, RUBEN

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/17, etxean.
POLIZI TALDEA................... Polizia Nazionala.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/6/20
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egunkaria, 92/6/21
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Ez dira jasandako torturak zehazten.

## 113.ANDRADES PEREZ, SALVADOR

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/18, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Polizia Nazionala.
ONDORIOA....................... Aske kargurik gabe, 92/6/20
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egunkaria, 92/6/21
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Egunkari honek jasotako berrian ez dira inkomunikaturik egondako denboran jasandako torturak zehazten.

## 114.GOLDARAZ ALDAIA, JAVIER

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/18, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/6/24
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/6/25
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Atxilotuak esan zuenez atxiloketa oso bortitza izan zen eta haiek (Javier Goldaraz eta Santiago Diez) ez ziren inoiz ere horren aurka agertu. Atxilotutakoan, goardia zibilek behin eta berriro jo zituzten, horretarako beren armak erabiliz. Kolpe hauek eragin zizkieten Nafarroako Ospitalean sartzeko arrazoi izan ziren zauriak. Politraumatismoa eta ikusmen galera zeuzkan buruan emandako kolpeen eraginez. Ezkerreko besoa eskaiolatu egin behar izan zioten. Ospitalean kalez jantzitako goardia zibil batzuk elektrodoak jarriko zizkiotelako mehatxua egin zioten kable batzuk eta coca-cola lata bat erakusten zioten bitartean.

## 115.DIEZ URIARTE, SANTIAGO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/19, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/6/24
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/6/25
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Epailearen aurrean adierazpenik ez egiteko eskubide konstituzionalari eutsi zion. Nafarroako Ospitalean ingresatu zuten Javier Goldarazekin batera, bertan deslokamendu bat tratatu behar izan zioten. Begi bat ubeldurik zeukan eta beso biak benda eta eskaiolaz.

## 116.ETXANDI JUANIKORENA, SOTERO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA...... 92/6/20.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/6/23
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/6/24
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Epaitegi Nazionaleko Argibideetarako 4. Epaitegi Zentralaren titularra den Carlos Divar Epailearen aurrean inkomunikaturik egon zen denboran tratu txarrak jasan zituela salatu zuen eta leporatzen zitzaion guztia ukatu zuen.

## 117.JAUREGI, VITORIANO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/22, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/6/24
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/6/25
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Tratu txarrak salatu zituen, "boltsa" eta "bainuontziarena" besteak beste.

## 118.ALZUGARAI, DAVID

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/22, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/6/24
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/6/25
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Carlos Divar Epailearen aurrean torturak jasan zituela salatu zuen, "boltsa" eta "bainuontziarena" besteak beste.

## 119.ARNAL SANSIÑENA, KALI

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/22, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/6/24
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/6/25
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Epaitegi Nazionaleko Argibideetarako 4. Epaitegi Zentralaren titularra den Carlos Divar Epailearen aurrean egin zuen adierazpena eta bertan tratu txarrak jasan zituela adierazi zuen, "boltsa" eta "bainuontziarena" besteak beste.

## 120.IRURETA, ASIER

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/6/28, etxean.
POLIZI TALDEA................... Ertzaintza.
ONDORIOA........................ Aske, 92/6/29
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/7/1

Atxilotuari Ertzaintzak dokumentazioa eskatu zion eta honek une hartan ez zeukala erantzun. Kalean bertan kolpe ugari jaso zuen buruan, hanketan eta bizkarrean. (Gipuzkoa) Mendaroko Eskualdeko Ospitalera eraman zuten. Mediku txostenaren arabera kopetan zauri bat zeukan eta josi egin behar izan zioten; eskuineko beso eta ukondoa handiturik zeuzkan. (Gipuzkoa) Eibarreko komisaldegian

beldurtu egin nahi izan zuten.

## 121.BAUTISTA MACIAS, JOSE

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/8/29, kalean.
POLIZI TALDEA.................. Polizia Nazionala.
ONDORIOA....................... Aske 92/8/30
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/8/30
Egin, 92/8/31
El Mundo, 92/8/31

(Bilbo) Basurtuko Ospitalera eraman behar izan zuten atxilotu zuten unean poliziak armaz jo eta sudur hezurra apurtu baitzion. Urgatzi zuen medikuak tratamendua behar zuela esan zien poliziei baina hauek ez zioten jaramonik egin eta (Bilbo) Indautxuko komisaldegira eraman zuten.

## 122.LATORRE ARAMENDI, ANDERE

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/8/30, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Ertzaintza.
ONDORIOA....................... Aske, 92/8/31
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/8/31

Atxilotuak koartelerako bidean jo egin zutela adierazi zuen, baita ileetatik tira eta iraindu ere.

## 123.LANZAS COBOS, RAMOS

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/9/5, kalean.
POLIZI TALDEA.................. Udaltzaingoa.
ONDORIOA....................... Aske.
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/9/23
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Lanzas eta udaltzainen artean eztabaida sortu zen. Hauek jo egin zuten, lurrera bota eta esposatu. Erasoaren ondorioz, Lanzasi kokotsean zauri bat josi behar izan zioten. Ondoren udaltzaigoaren egoitzara eraman zuten, bertan lurretik herrestan ibili zuten eta tratu txarrak jasan zituen.

## 124.BERNAOLA EREÑO, BEGOÑA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/10/19, lantokian.
POLIZI TALDEA.................. Polizia Nazionala.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/10/22
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/10/23
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Baltasar Garzon Epailearen aurrean esan zuenez, Madrilen umiliazioak, irainak eta abokaturik gabeko galdeketak jasan zituen.

## 125.LLONA SAENZ, SABINO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/10/31, etxean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/11/2
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/11/3
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Baltasar Garzon Epailearen aurrean "boltsa" egin ziotela esan zuen, gorputz osoa kolpatu ziotela eta barrabiletan tinkada eta bihurketak egin zizkiotela. Honez gain, hanketan elektrodoak ipini zizkioten, lepoa estutzen zion burdinezko barra bat ere jarri zioten eta hil egingo zutelako mehatxua egin zioten etengabe.

## 126.ORTEGA ORTEGA, LAUREANO

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/5, kalean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/12/10
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/12/11
El Correo Espaá¤áol, 92/12/11

Bere Abokatua den Francisca Villalbaren esanetan, Laureano Ortegak Ismael Moreno Epailearen aurrean adierazpenak egiteari uko egin zion, hala eta guztiz ere jasan zituen torturen berri eman zuen. Gorputz osoa kolpatu zioten, elektrodoak jarri zizkioten, denbora guztian begiak estalirik eduki zituen eta hilko zutela eta "mendira" eramango zutelako mehatxua egin zioten. Goardia zibilek eskupeta tiroak egin zituzten bera zegoeneko ziegan.

## 127.LEON LARA, ENCARNACION

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/5, kalean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/12/10
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/12/11
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Goardia Zibilarekin izandako tiroketan bularrean zauritu zuten. Ismael Moreno, Epaitegi Nazionaleko Argibideetarako 2. Epaitegi Zentralaren titularraren aurrean egin zituen adierazpenak Gregorio Maraá¤áon Ospitalean. Adierazpenak egiteari uko egin bazion ere Goardia zibilaren aginduz Santanderreko Valdecilla Ospitalean ohearen hankari loturik eduki zutela esan zuen.

## 128.DIEGUEZ SILVEIRA, ELVIRA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/5, kalean.
POLIZI TALDEA.................. Goardia Zibila.
ONDORIOA....................... Kartzela, 92/12/10
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/12/11
El Correo Espaá¤áol, 92/12/11
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Buruan plastikozko boltsa bat jarri zioten eta honek itodura

sortarazi zion. Jo egin zuten, biluztu, lauzpabost gizon gainean jarri zitzaizkion eta maginan erratz makila sartu zioten. Elektrodoak jarri zizkioten gorputz osoan.

## 129.ELOSEGI URTEAGA, ARITZ

EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. El Mundo, 92/12/13
Egin, 92/12/14

92/12/12an A.K.K. ertzainak, kalez jantzita eta ertzaina zela jakinarazi ondoren, bera eta Aritz taberna batean zeudela tiro egin zion lepoan. Bertan zeuden lekukoek adierazi zutenez, arma erabili ondoren, ertzainak handik alde egin zuen biktimari laguntzarik eskaini gabe. Aritz DYAren egoitzara eraman behar izan zuten, hemendik Nuestra Señora de la Asuncion Tolosako ospitalera eta handik Donostiako erresidentziara. Balak, lepoan sartu zen arren, ez zuen bizi organorik kaltetu, ondorioz gazteari mediku alta eman zioten.

## 130.LARREA ELKOROBARRUTIA, IÑAKI

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/15, kalean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/12/20
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/12/22
Egunkaria, 92/12/22
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Salatutako torturak kolpeak, elektrodoak, "boltsa", "bainuontzia" eta heriotze mehatxuak izan ziren.

## 131.GURIDI ZALOÑA, ASIER

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/15, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/12/20
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/12/22
Egunkaria, 92/12/22
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Abokatuak esan zuenez, guztiz suntsiturik eta nabarmenki ukiturik zegoen. Salatutako tratu txarrak senitartekoak atxilotu eta zigortuko zituztelako mehatxuak, hiltzeko eta "mendira" eramango zutelako mehatxuak izan ziren. Elektrodoak, "bainuontzia", "boltsa" ezarri zizkioten eta jo ere egin zuten.

## 132.PIKE VITORIA, GORKA

ATXILOKETA DATA ETA LEKUA....... 92/12/15, etxean.
POLIZI TALDEA................... Goardia Zibila.
ONDORIOA........................ Kartzela, 92/12/20
EGUNKARIA ETA ARGITARATZE DATA.. Egin, 92/12/22
Egunkaria, 92/12/22
EPAILEAREN AURREAN TORTURAK SALATU ZITUEN.

Baltasar Garzon Epailearen aurrean salatutako torturak mehatxuak eta kolpeak izan ziren.

# KONTROLETAKO ERASOAK

## 1.KASUA

JAIME eta IÑIGO BENITO PASTOR, "El Mundo del Pais Vasco" egunkariaren ohizko banatzaileak, 1992ko urtarrilaren 27ko 9,30ean atxilotu zituen kontrol batean Goardia Zibilak Bilbotik Iruá¤áeara beren lana betetzera zihoazela. Atxilotutakoan, goardia zibilek beren ideologiari buruz galdetu zieten, haiek ez zuten erantzun nahi izan. Ezezkoaren aurrean, kontrolean geldiarazirik zeuden gainerako jendearengandik eta elkarrengandik urrundu zituzten. Une horretan hasi ziren mehatxuak eta kolpeak bular eta bizkarrean, ileetatik tira egin zieten, e.a. Jaime kamiseta hutsean utzi zuten eta Iá¤áigo jertse batez, egin zuen hotzari muzin eginez. Egitate hauek Bilboko Argibideetarako 3. Epaitegian salatu zituzten 1992ko otsailaren 5ean.

## 2.KASUA

SANTIAGO HERNANDO SAEZ, Laudioko Udaletxeko Herri Batasunako zinegotzi ohia, kolpatu egin zuten, garunean hainbat kasketako eman zizkioten, orkatiletan jo zuten, bizkarra zanpatu, eta behin barrabiletatik tira egin zioten. Langraitz eta Murgia inguruetan zeuden goardia zibilen bi kontroletan mehatxatu ere egin zuten, iraindu eta 3 ordutik gora bertan eduki 1992ko urtarrilaren 26an eta otsailaren 16an. 1992ko martxoaren 13an, Santiagok telefono dei bat jaso zuen, dei horretan kontroletan parte hartu zuen goardia zibiletako baten ahotsa ezagutu zuen. Deia egin zuenak beraiekin lan egiteko esan zion. Hernandok egitate hauek salatu egin zituen Bilboko Argibideetarako 1. Epaitegian 1992ko martxoaren 21ean. 1992ko irailaren 10ean Gasteizeko Epaitegira agertu zen maiatzaren lehenengo astean Aiara eskualdean beste kontrol bat jasan behar izan zuela eta honekin batera, beste biak ere salatuz.

## 3.KASUA

JUANA ERNAGA ESNOZ, Josepa Ernaga preso politikoaren ahizpa 1992ko otsailaren 5eko arratsaldean atxilotu zuten (Nafarroa) Mezkiriz inguruan goardia zibil batzuk sirenez errepideak geldiarazi zutenean. Goardia zibilek Juanari neba eta ahizparen ihardueren berri galdetu zioten eta atxiloketa unean Juanarekin zegoen 3 urteko bere semea kotxe barruan egotera behartu zuten. Ernagaren esanetan, goardia zibilen jarrera une oro harrokeriazkoa eta beldurgarria izan zen Juana hiru metraileten kainoien pean eduki zuten. Zeramatzan lentilak kendu nahi izan zizkioten baina Juanak ez zien utzi. Kotxea arakatu zioten, haurra barruan zegoela, eta araketa ikus zezan eragotzi zioten.

## 4.KASUA

KEPA PETRALANDA, Egin egunkariko erredaktorea, 1992ko martxoaren 25ean atxilotu zuten Urduliz inguruan zegoen Goardia Zibilaren kontrol batean. Araketa exhaustiboa jasan behar izan zuen kontrola kendu eta ordu bete gehiago ere iraun zuena. Goardia zibilek agendan zeuzkan telefono zenbaki eta datu guztiak hartu zizkioten.

## 5.KASUA

1992ko martxoaren azken aldera Hernaniko inguru eta auzoetan Goardia Zibileko (Unidades Antiterroristas Rurales) UARekoen kontrol ugari jarri zituzten. Goardiak gune guztia hartzen zuten baserri eta etxeetan nortzu bizi ziren, nolakoak ziren, e.a. galdetuz. Hernaniko Jauregi auzoan pisuz pisu eta etxez etxez ibili ziren.

## 6.KASUA

"Askatasuna eta Bakea" ibilaldiko txirrindulari bati eraso egin zion Goardia Zibilak. (Nafarroa) Belate mendatetik jaistean Goardia Zibilaren hiru Nissan Patrol ibilaldikideen atzean jarri ziren haietako batengana hurbilduz. Geroxeago, goardia zibilek inguratu egin zuten, errepidetik aterarazi eta bidebazterrera bota zuten.

## 7.KASUA

Hondarribiko Amuteko Auzo Elkartearen salaketa baten arabera koartela Agustinoen antzinako komentuan zeukaten goardia zibilek hilabeteak zeramatzaten hango biztanleak beldurtzen. Testigantzaren arabera, gauez goardia zibilek, koartela dagoeneko muinotik jaitsi eta ibilbidean zeuden kotxeak geldiarazi egiten zituzten baserrietako ateak jo eta etxekoak kanporarazi. Era berean auzoko gazteak ere beldurtu egiten zituzten.

## 8.KASUA

MAURICIO OLITE, Herri Batasunako Nafarroako parlamentaria. 1992ko urriaren 18an Goardia Zibilak erretenitu egin zuen Acebo herrian bere familiarekin batera autodeterminazio eskubidearen aldeko manifestazioan parte hartzeko Bilbora zihoala. Iruñeako legegintz ganbarako Giza Eskubideen Batzordeak 1992ko urriaren 28an Oliterekin hitz egin zuen; berak eta bere familiak kontrolean jasandako tratua adierazi zuen Olitek. Bortizki arakatu egin zuten, iraindu egin zituzten, baita foru parlamentaria zela adierazi ondoren ere.

## 9.KASUA

1992ko azaroaren 19ko 22:00etan, HUMBERTO TRAPERO UNZUETA eta ALBERTO BARRONDO GOIOAGA Otxandiora zihoazen, (Bizkaia) Urkiola gainera iritsi zirenean Goardia Zibilaren sei bat Nissan Patrol aurkitu zituzten errepide ondoan inolako seinaleztapenik gabe, eta hauek geldiarazi egin zituzten. Kotxetik heriotze mehatxupean jaitsiarazi ondoren jipoitu egin zituzten, ostiko eta ukabilkadaka, batez ere barrabiletan. Goardia zibilek Herri Batasunako bi kide hauek zeramatzaten agiri guztiak fotokopiatu zituzten. 1992ko azaroaren 30ean Bilboko Epaitegian aurkeztu zuten salaketa.

## 10.KASUA

ELIAS MINER VILLANUEVA Astigarraga eta Oiartzun lotzen dituen errepidean atxilotu zuen Goardia Zibilak kontrol batean, 1992ko azaroaren 21eko 23:30ean. Nortasun agiria eskatu eta kotxea arakatu ondoren, aurpegia estalirik zeramaten zenbait goardia zibilek ostiko eta kolpeak eman zizkioten. Goardia zibil batek eskupeta bat jarri zion bularrean, besteak kamiseta jaso eta ditiburuak ikutu zizkion eta aldi berean "popatik emango" ziotelako mehatxua egiten zioten. "Sasikumea" deitu zioten eta hurbileko ibai batera botako zutela esan zieten. 1992ko azaroaren 24ean Hernaniko Epaitegian salaketa aurkeztu zuen.

## 11.KASUA

GOTZON GARAIZABAL PILDAIN 1992ko azaroaren 23ko 21:45ean atxilotu zuten Apatamonasterio inguruan zegoen Goardia Zibilaren kontrol batean. Gotzon berarekin zihoan pertsonarengandik aldendu eta Goardia Zibilaren ibilgailu baten atzekaldera eraman zuten, hemen goardia zibil batek armaz barrabiletan jo zuen. Ondoren kolpeak eman zizkioten bizkarrean, lepoan, ukabilkadak eta ostikoak. Geroago lurrera bota zuten eta bertan kolpe gehiago eman zizkioten. 1992ko azaroaren 30ean salaketa aurkeztu zuen Bilboko Argibideetarako 4. Epaitegian.

## 12.KASUA

AITOR SAMPEDRO LOPEZ DE ALDA eta AITOR ROJAS IBAÑEZ IBAÑEZ DE ELORRIAGA gazteak 1992ko azaroaren 25eko 20:45ean atxilotu zituzten Goardi Zibilaren kontrol batean Marieta eta Ozaeta herrien artean. Goardia Zibilek kotxetik jaitsiarazi zituzten, nortasun agiria eskatu zieten eta arakatu ondoren mendira begira jarri zituzten eskuak bizkarrean zituztela, gero banan©banan interrogatu zituzten. Galdeketan SANPEDRO armaz jo zuten bizkarrean, ROJAS eskuargi batez jo zuten buruan eta lurrera bota, bertan zegoela tiro bat joko ziotela esan zioten. Ordu t'erditik gora iraun zuen galdeketan hil egingo zutelako mehatxua egin zieten, iraindu eta jo egin zituzten. Joan aurretik bira ematera behartu zituzten eta une horretan haien aurrean zeuden lau goardia zibilek armak kargatu eta afusilamendu itxurak eginez armak haiengana zuzendu zituzten. Gazteek 1992ko azaroaren 27an salaketa aurkeztu zuten Gasteizeko Epaitegian.

## 13.KASUA

DAVID ZUÑIGA ESCORZA eta IÑAKI URIZA EZCURDIA Goardia Zibilak San Roman inguruetan zeukan kontrol batean atxilotu zituzten azaroaren 25ean. Goardia zibilek nortasun agiria eskatu zieten eta une horretan hasi zuten galdeketa. Atxilotu egingo zituztela esan zieten eta aldi berean hanketan kolpeak eman zizkieten. 3 bat orduz eduki zituzten bertan. Biktimek 1992ko abenduaren 2an Iruá¤áeko Argibideetarako 2. Epaitegian salaketa aurkeztu zuten.

## 14.KASUA

FERMIN MUGURUZA UGARTE eta JUANA MARIA UNANUA VILLAVA (Nafarroa) Endarlatsa inguruko Goardia zibilaren kontrol batean atxilotu zituzten 1992ko azaroaren 29ko 00:40ean. Muguruza bi aldiz arakatu zuten goitik behera eta kotxetik 15 bat metro alden zedin behartu zuten. Iraindu egin zuten eta eskuargiaz joko zutela esan zioten. Denbora guzti horretan honen laguna mendira begira eduki zuten. Bere atzean goardia zibil bat jarri zen eta etengabe arma kargatu eta deskargatzen aritu zen. Honen ondorioz gazteak nerbio atake bat jasan zuen egoerak sortarazitako beldurraren eta haiekin zer egingo zuten ez jakitearen eraginez 1992ko abenduaren 4ean Irungo Epaitegian aurkeztutako salaketaren arabera.

## 15.KASUA

(Unidades Antiterroristas Rurales) UAReko 50 bat kidez osaturiko talde batek Urbasa inguruan zebilen txirrindulari talde bat izutu zuen abenduaren 13ko 10:00etan. Goardia zibilek fusilak erabili zituzten eta txirrindulariak geldiarazteko airera tiro egin zuten hiru bat aldiz. Goardia zibilen jarrera une oro erasokorra eta iraingarria izan zen. Goardia zibilek lau bizikletetako arradioak apurtu zituzten.

# PRESOEN AURKAKO ERASOAK

## 1.VIDAL, DANIEL

DATA.......... 92/2/7
LEKUA......... Salto del Negro Kartzela (Kanaria Handia)

Ziegako leihoko barroteei esposaturik eduki zuten eta honela zegoela funtzionariek gogorki jipoitu zuten. Ondoren, isolamendu ziega batean sartu zuten eta oheari esposaturik egon zen 24 orduz. Kolpeen ondoriozko zauriak astebete geroago urgatzi zizkion kartzelako medikuak.

## 2.ETXEANDIA, JON

DATA.......... 92/2/7
LEKUA......... Salto del Negro kartzela (Kanaria Handia)

Isolamendu ziegetara eraman zuten eta esposatu ondoren, ostikoka jipoitu zuten.

## 3.AKAITURRI, IÑIGO

DATA.......... 92/3/2
LEKUA......... Alcala-Mecoko Kartzelatik Jaengora zeramatela.

Goardia zibilak hormaren kontra jartzera behartu zuen. Ostiko eta irain artean orkatiletan, hanketan eta barrabiletan jo zuten. Esposak hain estu jarri zizkioten ezen odolak ez baitzezakeen zirkulatu.

## 4.BERISTAIN, JOSE MARIA

DATA.......... 92/3/2
LEKUA......... Alcala-Mecoko Kartzelatik Almeriakora zeramatela.

Goardia zibilak hormaren kontra jartzera behartu zuen. Ostiko eta irain artean orkatiletan, hanketan eta barrabiletan jo zuten. Esposan hain estu jarri zizkioten ezen odolak ez baitzezakeen jario.

## 5.URIZAR DE PAZ, GERMAN

DATA.......... 92/3/12
LEKUA......... (Madril) Carabanchelgo 7. galeria.

Funtzionariek galeria horretako presoak ziegaz aldatzera, flexioak egitera eta biluztera behartu nahi izan zituzten, presoek uko egin zioten eta jipoitu egin zituzten.

## 6.TORRECILLA PARRA, CARLOS

DATA.......... 92/3/12
LEKUA......... (Madril) Carabanchelgo 7. galeria.

Bere kideekin batera ziegaz aldatu, flexioak egin eta biluzteari uko egin zionean jaso zituen kolpeak.

## 7.LOPEZ ROMERO, PABLO

DATA.......... 92/3/12
LEKUA......... (Madril) Carabanchelgo 7. galeria.

Kideek jasandako tratu bera jasan zuen.

## 8.MARKINA, IÑAKI

DATA.......... 92/3/12
LEKUA......... (Madril) Carabanchelgo 7. galeria.

Kideek jasandako tratu bera jasan zuen.

Galeria honetan bertan Terra Lliureko preso bat Ignacio Martinez eta Javier Ros Diaz zeuden. Azken hau Kartzela Ospitalera eraman behar izan zuten.

## 9.AGIRRE AGIRRE, JOXEAN

DATA.......... 92/3/12
LEKUA......... Ceutako kartzela.

Pixama apurtu arte jipoitu eta mehatxatu egin zuten. Ondorioa zauriak, hematomak eta urratuak izan ziren.

## 10.LOPEZ DE SANTACOLOMA, JOSU

DATA.......... 92/3/27
LEKUA......... Huelvako kartzela

Lepo eta iletik hartu zuten eta isolamendu ziegara eraman, bertan funtzionariek jipoitu egin zuten lurrean eroririk zegoela.

## 11.ASKASIBAR GARITANO, MIKEL

DATA.......... 92/5/17
LEKUA......... (Ciudad Real) Herrera de la Manchako kartzelarako bidean.
Goardia zibilak hirutan jipoitu zuen; goardia zibilaren esku utzi orduko, furgonetarako bidean eta furgonetan bertan.

## 12.CABELLO PEREZ, ANDONI

DATA.......... 92/5/17
LEKUA......... (Toledo) Ocaña-2 kartzelarako bidean.

Hiru eraso jasan zituen jarraian. Lehenengoan jo eta biluztarazi egin zuten. Bigarrena, eramango zuen furgonetarako bidean, eta hirugarrena ibilgailuan bertan. Jipoia goardia zibilek eman zioten.

## 13.MUIÑOS GARCIA, MANUEL

DATA.......... 92/7/14
LEKUA......... (Cádiz) Puerto de Santa María II kartzela.

Funtzionariek gogorki jipoitu zuten, mugitzea eragotzi zioten eta oheari esposatu. Jarrera honetan zegoela funtzionari batek ukabilkadak eman zizkion. Manueli sudurra eta ezpainak apurtu eta begi bat ubeldu zizkion. Kartzelako medikua iritsi arteko tarte luze horretan egon behar izan zuen horrela eta hark aska zezaten agindu zuen. Hurrengo egunean Valentziako kartzelara eraman zuen eta hemen Kartzela Jagotzarako Epailearen aurrean jipoia salatu

zuen uztailaren 17an.

## 14.BASABE LARRINAGA, EDUARDO

DATA.......... 92/8/17-18
LEKUA......... (Toledo) Ocaña-1 kartzelatik (Araba) Langraitzekora zeramatela.

(Madril) Alcalá-Mecoko kartzelan, furgoira igo aurretik, ukabilez eta ostikoka jo zuten jagotzaren ardura zeukaten goardia zibilek. Gaua Burgoseko kartzelan eman ondoren, furgoira zihoala, gainerako kideengandik aldendu eta berriro jipoitu zuten giltzurrinetan kolpeak emanez, belaunkadak, ukabilkadak eta mehatxu eta irainak. Langraitzen beste jipoi bat eman zioten.

## 15.CRISTOBAL AZNAR, GERMAN

DATA.......... 92/8/17-18
LEKUA......... (Toledo) Ocaña-1 kartzelatik (Araba) Langraitzekora zeramatela.

Bidean hiru jipoi eman zizkioten jagotzaren ardura zeukaten goardia zibilek. Lehengoa (Madril) Alcala-Mecoko kartzelan ukabilez eta ostikoka. Bigarrena Burgoseko kartzelan eta hirugarrena Langraitzen bertan.

## 16.ETXEBESTE AROZENA, PAKO

DATA.......... 92/8/18
LEKUA......... Burgoseko kartzelatik (Gipuzkoa) Martutenekora zeramatela.

Zeraman furgoian eta hau martxan zegoelarik, jagotzaren ardura zeukaten goardia zibilek jo zuten. Erasoaren ondorioz begi bat eta masail inguruan kalteak izan zituen, baita soiluneak ere kolpe eta ile tiraketen ondorioz.

## 17.TORRE ALTONAGA, JOSE ANTONIO

DATA.......... 92/8/19
LEKUA......... (Araba) Langraitzeko kartzelatik (Toledo) Ocaá¤áakora zeramatela.

Jipoia Burgoseko kartzelan eman zioten goardia zibilek.

## 18.ALBERDI MARKINA, ANDER

DATA.......... 92/8/19
LEKUA.........

Lekualdaketan jipoitu zuten goardia zibilek.

## 19.ALKORTA GOROSTIDI, IDOIA

DATA.......... 92/8/21
LEKUA......... (Alicante) Font Calent©eko kartzela.

Isolamendu departamentuan sute bat izan ondoren, presoak berriro ere ziegatan sartzera behartu zituzten oraindik kea zerietela zeudelarik. Idoia mehatxatu egin zuten eta ziegan kolpeka eta bultzaka sarrarazi zuten. Gainerako presoek ere tratu bera jasan zuten.

## 20.ZUGADI GARCIA, IñAKI

DATA.......... iraileko 2. astea.
LEKUA......... (Madril) Alcala-Mecoko kartzelatik
Valladolidekora zeramatela.

Lekualdaketan jipoitu zuten.

## 21.ARRESE GARATE, KOLDO

DATA.......... 92/9/12
LEKUA......... (Zaragoza) Darocako kartzela.

Kartzelan mutina izan zen, goardia zibilak baretzera joan ziren. Funtzionari batek koldo seinalatu zuen ETAko kidetzat nahiz eta mutinean parterik hartu ez, eta orduan hasi zitzaizkion erasoka. Behin baino gehiagotan jo zuten karate kolpeez, bate batez eta burdinezko barra batez. Jipoiaren ondorioz hainbat artikulazio eta sorbalda kalteturik zeuzkan. Preso gehiago ere eraso zituzten baina ez da jakin zein diren.

DATA.......... 92/9/29
LEKUA......... (Zaragoza) Darocako kartzela.

Iraindu eta porra batez jo zuten eta ondoren isolamendu modulu batera eraman.

## 22.GIL CERVERA, MIKEL

DATA.......... 92/9/12
LEKUA......... Fresneseko kartzela (Paris)

10 funtzionariren artean jipoitu zuten. Ondorioz eskuineko begia kaltetu zioten eta hematomak eragin.

## 23.OTEGI MONDRAGON, ARNALDO

DATA.......... 92/9/10-15
LEKUA......... Ciudad Realeko kartzelatik Huescakora zeramatela.

10ean Herrera de la Manchako kartzelan goardia zibilek jipoitu

zuten. Ondorioz, ezpain bat zauritu zioten eta gorputz osoan zehar hematomak eragin. 15ean berriro ere jipoitu zuten (Madril) Alcala Mecoko kartzelara heldu zenean, ostiko eta ukabilkadak eman zizkioten eta aldi berean iraindu.

## 24.CABELLO PEREZ, PATXI

DATA.......... 92/9/23
LEKUA......... (Madril) Alcala-Mecoko kartzelatik (Cadiz) Puerto de Santa Mariakora zeramatela.

Eraman behar zuen furgoia heldu zenean goardia zibilek buruan eta barrabiletan jo zuten, eskuz, ukabilez eta ostikoka.

## 25.PUJANA ALBERDI, IÑAKI

DATA.......... 92/9/23
LEKUA......... (Madril) Alcala-Mecoko kartzelatik (Cadiz) Puerto de Santa Mariakora zeramatela.

Goian aipatutako tratu berbera jasanarazi zioten.

## 26.ARTOLA IBARRETXE, JOSEBA

DATA.......... 92/9/23-24
LEKUA......... (Cadiz) Puerto de Santa Maria II kartzelatik (Madril) Alcala-Mecokora zeramatela.

Cordobako kartzelara heltzean goardia zibilek porraz jo zuten buruan. 24ean, Alcalarantz eramateko atera zutenean berriro ere jo egin zuten. Alcalara heldutakoan, orkatiletan ostikoak eman zizkioten. Erortzear zegoela, barrabiletatik tiraka hasi zitzaizkion.

## 27.PAROT, HENRI

DATA.......... 92/10/24
LEKUA......... Almeriako kartzelara zeramatela.

Goardia Zibilak jipoitu egin zuen.

## 28.MARTINEZ, JAVIER

DATA.......... 92/10/29
LEKUA......... (Madril) Alcala©Mecoko kartzelatik (Cadiz) Puerto de Santa Maria IIra zeramatela.

Kartzelako patioan jipoitu zuten sei goardia zibilek bizkar eta ipurdian ostikoak emanez. Beste eraso bat ere jasan zuen lekualdaketan egindako geldiune batean.

## 29.TAPIA GONZALO, JUAN CARLOS

DATA.......... 92/11/16
LEKUA......... (Madril) Alcala-Mecoko kartzela.

Lekualdaketan jagotzaren arduradun ziren goardia zibilek jipoitu zuten.

## 30.GOIKOETXEA MUNDUATE, JOSE

DATA.......... 1992ko azaroaren bukaera aldera.
LEKUA......... Jaengo kartzela.

Zenbait funtzionariren artean jipoitu zuten.

## 31.UGARTE ZINKUNEGI, JUAN JOSE

DATA.......... 92/12/3
LEKUA......... Jaengo kartzela.

Lurrera bota zuten eta ostiko eta kolpeak eman zizkioten gorputz osoan. Ondoren funtzionariak bere urdailaren gainean saltoka hasi ziren kontrola galdu eta kaka egin zuen arte. Erasoan kalte handiak eta saihetseko min handia eragin zizkioten; saihetsen bat apurtu edo pitzaturik eduki zezakeen. Presoak ezin izan zuen egiaztatu, astebete geroago medikuak ez baitzuen oraindik aztertu.

## 32.FERNANDEZ HERNANDO, JOSE ANTONIO

DATA.......... 92/12/11
LEKUA......... (Cadiz) Puerto de Santa Mariako kartzela.

Goardia zibilak jipoitu zuen kartzela batetik beste batera eramatera zihoazela. Garondokoak, orkatiletan ostikoak eman eta giltzurrin inguruan arramazkak egin zizkioten.

## 33.KASUA DE JUANA CHAOS, IÑAKI

DATA.......... 92/12/12
LEKUA......... Murciatik Alcala-Mecora zeramatela.

Goardia zibilak egin zuen lekualdaketa eta bertan jipoitu zuten. Hanka eta barrabiletan ostikoak eman zizkioten, ukabilkadak eman eta ileetatik tira egin zioten. Bide guztian zehar mehatxatu eta iraindu egin zuten.

# GOSE GREBAK

## SALTO DEL NEGRO (LAS PALMAS DE GRAN CANARIA)

## LEHENENGO GOSE GREBA

Kartzela kanariar honetan 15 euskal preso dago, hauetatik 14 gizonezkoak dira eta bestea emakumea, 1992ko otsailaren 3an honako 14 preso hauek gose grebari ekin zioten: FRANCISCO CABELLO PEREZ, IÑAKI DE JUANA CHAOS, ANDER ERRANDONEA ARRUTI, ESTEBAN ESTEBAN NIETO, JON ETXEANDIA ZORROZA, JON GAZTELUMENDI URIBARREN, PEDRO GURIDI AROZENA, JOXEAN KORTADI ALUSTIZA, MANUEL MUINOS GARCIA, XABIER OREGI ETXEBERRIA, JON TAPIA IRUJO, EDORTA SAINZ LOBATO, DANIEL VIDAL MAGALLANES ETA JESUS Má¦á ZABARTE ARREGI. Edorta Sainz Lobatok hasi eta 30 egunera grebari utzi egin behar izan zion osasun arazoak zirela eta.

Greba honen zioa 1992ko otsailaren 1ean Jon Etxeandia eta Daniel Vidal euskal presoei funtzionariek emandako jipoia da, gose greba bi egun geroago hasi zen eta horren bitartez, presoak bizimodu duin baterako oinarriak ezarri nahi zituzten. Hauexek ziren planteatutako erreibindikazioak:

1.Jipoi eta gorputz-zigorrak desagertaraztea.

2.Jasan behar duten isolamendua desagertaraztea: euskal preso guztiak modulu bakarrean biltzea, patio-ordu gehiago, patiora beste euskal presoekin atera ahal izatea, e.a.

3.Giza garapenerako dauzkaten trabak desagertaraztea, kirol instalazioetarako sarbidea, eskulanak egiteko aukera, unibertsitateko irakasleekin komunikatzeko aukera...

4.Komunikazioei egiten zaizkien nahierako murrizketak desagertaraztea: 20 minutuko asteko bi bisitaldietako denbora egun bakarrean pilatu ahal izatea, lagunen bisitarako eskubidea betetzea, komunikazio bereziak eduki ahal izatea, senitarteko zuzenek ezin dutenean beste inork paketeak sartu ahal izatea, gutun kopuruaren muga kentzea...

5.Profesionari baten urgazpena jasotzeko trabak desagertaraztea: kartzelaz kanpoko medikuak sartu ahal izatea, abokatuekiko komunikazio askea, e.a.

41 egun geroago eman zuten amaitutzat gose greba, 1992ko martxoaren 14ean, honako puntu hauetan adostasuna lortu zutelako:

*Giza eskubideak betetzea eta jipoi eta irainekin amaitzea.
*Komunikazioetan hobekuntza nabarmenak.
*Mediku urgazpen egokia bermatzea eta medikuaren zeregina lanbidearekikoa izatea guztiz eta ez kartzel©zaindariarena.
*Barne erregimena aldaraztea, ziega barruan egon beharreko denbora murriztuz.

## BIGARREN GOSE GREBA

El Salto del Negro kartzelako Zuzendariak, Francisco Sanz Garciak, akordioak betetzen ez zituenez, aipatu kartzelako 13 presoek (Jon Etxeandia salbu, epai-eginbidetarako Alcala-Mecoko kartzelara eramana baitzen) berriro ere gose grebari ekin zioten 1992ko apirilaren 24ean aurreko erreibindikazio berberak eginez. Egoera honen gaizkoagarriak dira presoen osasun egoera, aurreko

gose greban 20 kilo inguru galduak baitzituzten eta Iñaki de Juana Chaosen kasua, osasun egoera zela eta kartzelako erizaindegira eraman behar izan baitzuten.

Bigarren greba honetan parte hartu zuten presoak aurrekoan hartu zutenak berberak dira, Jon Etxeandia ezik. Iñaki de Juana Chaos ere penintsulako kartzela batera eraman zuten maiatzaren 13an. 10 egun luzez ez zen non zegoen jakin, El Salto del Negro kartzelako zuzendaritzak nora eraman zuten esateari baita presoaren senitartekoei ere uko egiten baitzion. Azkenik Malagako kartzelan agertu zen eta bertan jarraitu zion kartzela kanariarrean hasitako gose grebari, zeina maiatzaren 22an amaituko baitzuen.

1992ko maiatzaren 20an gose grebari egarri greba gehitu zioten preso hauek. Maiatzaren 25ean gose greba honetan parte hartu zuten guztiak, lau ezik, kartzelako erizaindegian zeuden eta aldizka gatzura ematen zieten.

1992ko ekainaren 1ean, hasi zenetik 39 egunera, amaitutzat eman zuten greba Zentroko Zuzendaritzarekin 15 puntuko akordio bat lortu baitzuten.

Maiatzaren 11tik 17ra El Salto del Negro kartzelako 50 bat preso sozialek antzeko arrazoiak zirela eta gose greba egin zuten. Protesta horren ondoren 36 preso sozial beste kartzela batzuetara eraman zituzten.

## HIRUGARREN GOSE GREBA

1992ko azaroaren 8an 5 euskal presok berriro ekin zioten gose grebari kartzelako bizi baldintza degradatzaileengatik protestan eta Zentroko Zuzendaritzak ekainaren 1ean lortutako akordioak betetzen ez zituelako.

Greba honi ekin zioten presoak hauek dira: FERNANDO ARBURUA IPARRAGIRRE, JOSE ANTONIO FERNANDEZ HERNANDO, JESUS Má¦á ZABARTE ARREGI, FRANCISCO CABELLO PEREZ eta JOXEAN KORTADI ALUSTIZA. Azken hirurek kartzela horretan egindako aurreko gose grebetan ere parte hartu zuten.

Azaroaren 13an JON ETXEANDIA ZORROZA eta ESTEBAN ESTEBAN NIETO presoak El Salto del Negro kartzelara heldu ziren epai-eginbideetarako Alcala-Mecoko kartzelan izan ondoren eta beren kideek zeramaten gose grebari lotu zitzaizkion.

1992ko abenduaren 5ean kartzela honetako euskal presoek gose grebari utzi egin zioten Zentroko Zuzendaria lekualdatu eta beste inor izendatu ez izanaren ondorioz botere hutsunea zegoelako kartzelan.

1992an El Salto del Negroko euskal presoek lau gose greba egin zituzten, beren katzela egoerarekin zein euskal preso politiko guztien egoera orokorrarekin zerikusia daukaten egitateak salatzeko. Hauexek izan ziren gose grebak:

*Martxoa: 7 eguneko gose greba Jon Etxeandiari (berriro jipoitu zuten presoetako bat) emandako jipoia salatzeko.

*Ekaina-uztaila: 20 egunetik gorako gose greba, bertan kanpoarekiko (gutun kopurua mugatzea, prentsa jasoketa...) eta barruarekiko (euskal preso guztiak modulu bakarrean biltzea, egun-argia sartzea eta ziegaren aireztapena eragozten zuten metalezko txapak kentzea, e.a.) desagertaraztea exijitzen zen.

*Urria: 6 eguneko gose greba, indarrean dagoen legeria aplikatuz, euskal preso politiko guztiak Euskadin biltzea eskatzeko. Gose greba jarrai eta etenkako honi euskal preso politikoen kolektiboak jarraitu zion bi hilabete t'erdiz.

*Abendua: 6 eguneko gose greba arrazoi berberengatik eta kolektibo guztiak batera egina.

## CEUTA

Ceutako kartzelako bost euskal presoek 1992ko martxoaren 16an gose greba mugagabe bati ekin zioten 1991ko irailetik (sei hilabete baino gehiago) eguneko 24 orduak ziega barruan itxirik jasaten ari ziren isolamendu egoeragatik protestan; aldi berean dagozkien eskubideen errespetua eskatzen zuten. Joxean Agirre euskal presoa aipatu kartzelan goizaldeko 01:00 egindako bortxazko araketa batean biluztera behartu zuten, honek uko egin zion eta funtzionariek jipoitu egin zuten, handik lau egunera hasi zen greba.

Gose greban zeuden presoak hauexek ziren: JOXEAN AGIRRE AGIRRE, JOKIN ALDANONDO LUZURIAGA, EMILIANO BIAÑA BALDA, ESTANIS ETXABURU SOLABARRIETA eta CARLOS GIL GARCIA.

Euskal presoek gose greba amaitzeko baldintzatzat jarritako erreibindikazio taulako punturik garrantzitsuenak hauexek ziren:

1.Osorik biluzturik araketak inposatzeko ahaleginak desagertzea.

2.Modulu bakarrean biltzea isolamenduaren ondoriozko gehiegikeriak saihesteko.

3.Bisitaldia elkarrekin egin ahal izatea.

4.Gorputz zigorrak desagertzea eta pertsona diren aldetik dagozkien eskubideak errespetatzea, Kartzela Jagotzarako Epaileak ildo horretan egindako ebazpenak betetzetik hasiz.

31 gose greba egun zeramatenean presoek zeukaten osasun egoera 12 eta 18 Kg. arteko galeran “kasuak kasu”, goitika naharoak, zorabioak eta ahultasunean ikus zitekeen.

Azpimarratzekoa da gose grebaren hasieratikn mihaketa eta gaueko kontaketak etengabeak izan zirela, presoei loa eragotziz.

Apirilaren 22an Carlos Gil presoak kartzelako Zuzendariarekin elkarrizketa bat eduki zuen eta Gilek erreibindikazio taula jakinarazi zion:

1. Presoen pilaketa.

2. Patiora ateratzeko biluztu beharrik ez.
3. Gosaria patiorako denboratik ez deskontatzea eta patio ordu hauek jarraian izatea goizez ala arratsaldez.
4. Gau eta goizaldeko mihaketa eta kontaketak desagertzea.
5. Astean bi gutun baino gehiago idatzi ahal izatea.
6. Epai©ebazpenak betetzea.

Ceutako "Los Rosales" kartzelako Zuzendariak 2, 3, 4 eta 5 puntuekin bat datorrela adierazten dio eta 1 eta 6 puntuei buruz Madrilekin hitz egin behar duela. Apirilaren 23ko arratsaldean, Madrilekin hitz egin ondoren, Zuzendariak puntu guztiekin bat datorrela jakinarazten die medikuaren bitartez. Presoek zuzendariarekin zuzenean hitz egitea eskatzen dute eta arratsaldean hala gertatzen da. Alde biak ahozko akordiora heltzen dira eta Zuzendariak bost eguneko epea eskatzen die presoak pilatu eta akordioak betetzen hasteko. Egun horretan bertan, apirilaren 29an, presoek grebari utzi egin zioten 39 egunen ondoren.

## ALMERIA

1992ko apirilaren 13an, JOSE MIGUEL LATASA presoak gose grebari ekin zion Almeriako kartzelan jasaten zuen isolamendu egoeragatik protestan.

Apirilaren 21ean preso honek gose grebari utzi zion zortzi egun egon ondoren, eta kartzela horretara heldu zenetik aplikatzen ari zitzaion erregimen berezia kendutakoan.

## PUERTO DE SANTA MARIA II (CADIZ)

### LEHENENGO GOSE GREBA

1992ko ekainaren 10ean, Puerto de Santa Maria II kartzelako bost presok gose grebari ekin zioten, bertan parte hartu zuen IÑAKI DE JUANA CHAOSek aurreko egunean (ekainak 9) Malagatik ekarri berria zutenak. Grebari ekiteko arrazoiak alde batetik, De Juanari inolako mediku urgazpenik ez eskaintzea zen, El Salto del Negro (lehenengoa osorik eta bigarrena eten baina Malagan segitu zuen) eta Malagako kartzeletan egindako gose greben ondorioz zuzpertzea eragotziz, eta beste aldetik, kartzela horretan ezartzen zituzten bizi baldintzak salatzea.

De Juana Chaos Malagako kartzelatik Puerto de Santa Maria IIra eraman zuten kartzelako medikuak honi uko egin arren, berak esana baitzen osasun egoerak ez ziola halako lekualdaketarik ahalbideratzen “etengabeko sukarra eta beranzkoa zeuzkan, gose greba luzeak eraginak”. Puerto IIko medikuak ez zion zuzperketarako inolako laguntzarik eskaini nahi izan, kasuak behar zuen dieta berezia ere ukatuz.

1992ko ekainaren 15ean gose greba amaitutzat eman zuten Zentroko Zuzendaritzarekin akordioa lortutakoan. Akordioaren edukia hauxe

izan zen:

1. Euskal preso politikoei bisitak egun berean egin ahal izatea, preso bakoitzarentzat egun ezberdin bat edukitzeak senitartekoei ekartzen zizkien antolakuntz eta ekonomi arazoak saihesteko.

2. Gutun kopuru muga desagertaraztea.

3. Patio denbora lau ordura hedatzea.

4. Hileko telefono dei bat eta kartzelarteko beste deia preso dauden neskalagunekin hitz egiteko, beti ere baimendurik baldin badago.

5. Eskulanak egin ahal izatea.

6. Aurretik eskaera orria betez lagunekiko bisitak eduki ahal izatea.

7. Patiora binaka ateratzea. Ordura arte Zuzendaritzak bananªbanan ateratzera behartzen zituen.

8. Zuzendaritzaren aldetik, Iñaki de Juanaren zuzperketa ahalbideratzeko konpromezua, horretarako behar zen mediku eta elikadura urgazpenaz.

**BIGARREN GOSE GREBA**

1992ko uztailaren 5ean Cadizeko kartzela honetako euskal presoek, Iá¤áaki de Juanak ezik, berriro ere gose grebari ekin zioten, Zuzendaritzak aurrekoarekin amaitzeko emandako hitza bete ez zuelako.

Bigarren gose greba honetan parte hartu zuten presoak dira hauexek: ANTTON TROITIÑO ARRANZ, RICARDO PRIETO VICENTE, JOSE MARIA ETXANIZ ZORRILLA, JOSEBA BASTERRA URRUTIA, JUAN TRECET SASTRE, KEPA URRA GURIDI, JOSEBA ARTOLA IBARRETXE, IÑAKI BILBAO GOIKOETXEA eta GRAPOkide bat.

Gose greba hasi zutenetik funtzionariek etengabe jazarri zitzaizkien; hiru egunetik behin ziegaz aldatuz, egunero bisitatzen zituzten, gauez eta goizaldean ziegetako ateak kolpatuz, argiak piztuz, oihuka, e.a. honela presoei loa eragotziz.

IÑAKI DE JUANA presoa ere gose grebari lotuko zaio uztailaren 12an.

Beren erreibindikazioen artean preso politikoak modulu bakarrean eta isolamendurik gabe biltzea zegoen. Eguneko lau patio ordu eta ziegen egokitzapena (girgiluen erabilpena eta bakarturik zeuden preso sozialen aurkako umiliazioak salatu zituzten) ere eskatu zituzten, azken horretarako sanitate-arrazioak planteatu zituzten, hala nola margotzea “odol eta goitikinez beterik baitzeuden”, hilero desarratoitzea edo janarirako azpilak eskura ematea eta ez ohi zuten bezala lurrean utziz. Eskulanak egin, kasete edo irratia eduki, komunean kortina bat ipintzeko baimena ere eskatzen zuten, astean behineko garbiketa-zerbitzua, ziega

aldaketa gehiagorik ez egotea eta araketetan biluztarazi beharrean eta metal-detektagailuaz egin zitzatela ere eskaeren artean zeuden. Era berean, "vis a vis" komunikazio bereziak, telefono deiak eta mediku-urgazpen egokia ere eskatzen zituzten. Azkenik, greba amaitutakoan, Zuzendaritzak grebak iraun zuen egun kopuru bikoitza iraungo zuen zuzperketaldi bat ahalbideratuko zuen, mediku taldearekin hitzartu beharreko baldintzapean.

Hasi eta 26 egunera, 1992ko abuztuaren 1ean hain zuzen, preso hauek amaitutzat eman zuten greba zentroko Segurtasunerako Zuzendariordearekin ahozko akordioa lortu zutelako.

## ALICANTE

CARLOS RECIO euskal preso politikoak Alicanteko kartzelan gose grebari ekin zion 1992ko ekainaren 24ean, jasaten ari zen isolamendu egoera salatzeko.

Uztailaren 8an Carlos Reciok grebari utzi egin behar izan zion ultzerak jo zuelako.

## VALENTZIA

1992ko uztailaren 20an MANUEL MUIÑOS GARCIA euskal presoak, Valentziako kartzelan zegoela, gose eta egarri grebari ekin zion jasaten zuen osasunaren kalterako (ziegan higiene egoera ezin okerragoa, bertan arratoiak ere baitzeuden) eta isolamendu egoera, bai eta era berean, Puerto de Santa Maria II kartzelan jasandako jipoia ere salatzeko (59. orr. 13.kasua).

Euskal presoak El Salto del Negron egindako beste bi gose grebatan ere parte hartu zuen, guztira 80 egunetik gora betez.

1992ko uztailaren 29an Manuel Muiñosek grebari utzi behar izan zion erizaindegira eraman behar izan zutelako.

## MURCIA

IÑAKI DE JUANA CHAOS euskal presoak 1992ko irailaren 3an berriro ere gose eta egarri grebari ekin zion Murciako kartzelan, bertan zegoen berriki Puerto de Santa Maria II kartzelatik eraman zutenetik. Honekin bost dira sei hilabetean egindako gose grebak (El Salto del Negro kartzelan egindako bi lehenengoak (bigarrena Salto del Negro eta Malagan) eta Puerto de Santa Maria IIn egindako biak).

Greba hau sortarazi zuena jasan behar zuen isolamendu egoera izan zen, honez gain ez zioten lo egiten uzten ziegako barroteetan kolpeak jotzen zituzten eta edonolako zaratak egin.

Murcian zeuden gainerako presoek ere grebari ekin zioten irailaren 4ean Iá¤áaki de Juana eta JOSEPA ERNAGA ESNOZ euskal

presoekiko elkartasuna adierazteko. Josepa kartzela bereko emakumeentzako sailean zegoen, bakarturik eta gose grebaz gain egarri greba ere hasi zuen.

Gose greban zeuden gainerako presoak hauek dira: GAIZKA AREIZAGA AROZAMENA, KOLDO DE MARCOS OLAIZOLA, JOSE ESNAOLA LASA, ENRIQUE LETONA BITERI, JOSEBA MARTINEZ DE BIRGALA, FRANCISCO MARTINEZ DE APESTEGIA eta JUAN EMILIO CARBAJAL ALVAREZ.

Presoek Zentroko Zuzendaritzari grebari uzteko baldintza gisa Iá¤áaki de Juana eta Josepa Ernagak jasan behar izaten zuten isolamendua desagertu eta hauek biak gainerako preson baldintza berberetan (hileko "vis a vis"ak, gainerakoek beste patio ordu edukitzea, ziega berean beste euskal preso batekin egon ahal izatea) egon zitezen jarri zioten.

1992ko irailaren 15ean grebari utzi egin zioten Zuzendaritzarekin akordio bat lortu zutelako.

### **LA SANTÉ** (ESTATU FRANTSESA)

La Santé kartzelan zegoen JOSEBA ARREGI euskal presoak 1992ko azaroaren 20an ekin zion gose grebari jasaten ari zen isolamendu egoera eta kartzela baldintzak salatzeko.

Hamaika egun geroago, abenduaren 1ean, grebari utzi egin zion Fleury Merogis kartzerala eraman zutelako.

## IGOERAK, INDULTUAK ETA KONDEKORAZIOAK

### RAFAEL MASA

Goardia Zibilaren Teniente Koronela den Rafael Masari 1991n Bilboko Epaitegiak beste bost goardia zibilekin batera sei urte eta egun bateko ezgaitze bereziko zigorra ezarri zion "Linaza kasua" deiturikoan prebarikazio delituagatik; une honetan Epaitegi Gorenaren aurrean kasazio errekurtso baten zain dago eta Herri Batasunako buruzagia zen Santiago Brouarden heriotzearekin ustezko zerikusia zeukalakoan adierazpenak egitera ere deitu zuten. Rafael Masa Goardia Zibilaren Informazio eta Ikerketa Zerbitzuetako buru izendatu dute.

Hau ez da ezgaitzearen ondoren Rafael Masari emandako lehenengo igoera, kondenaturik egon arren Boliviara destinatu baitzuten bertako agintariak narkotrafikoaren aurkako borrokan aholkatzeko.

Goardia Zibilaren Informazio eta Ikerketa Zerbitzuko Burutza ematea 1992ko martxoaren 6an gertatu zen. Hasieran, Benemeritako iturriek informazioa gezurtatu egin zuten horren berri ez

zeukatela esanez. Geroago, bigarren norakoa onartu egin zuten aipatu zerbitzuetako buru zela ukatu zuten arren.

## JOSE ANTONIO HERNANDEZ DEL BARCO eta PEREZ NAVARRETE

Erantzunkizun handiko norakoak jaso eta dauzkate oraindik nahiz eta 1992ko urtarrilaren 21ean Epaitegi Gorenak, 1985ean Donostiako Probintzia Epaitegiak emandakoa baiezten duen epaitza irmo batez debekatu. Epaitzak 4 urtez ezgaitu zituen tortura delitu frogatuak oinarritzat izanik. Juana Francisca Goikoetxea Azkueri egindako tortura delitua da. Juana Goikoetxea 1982ko urtarrilaren 7an Lege Antiterroristapean atxilotu zuten, Donostian zein Madrilen "kolpe eta ostikoak" eman zizkioten ETAkide zela onar zezan. Ondoren aske utzi zuten inolako kargurik gabe.

Hernandez del Barco berriki izendatu dute (SIGC) Goardia Zibilaren Informazio Zerbitzuaren buru den Angel Lopez Gonzalez Koronalen laguntzaile. Perez Navarretek, bestalde, Barne Ministroaren, Jose Luis Corcueraren Kabinetean egiten du lan arazo antiterroristetarako aholkulari.

Hau ez da ematen zaien lehenengo igoera, Hernandez del Barcok gutxira Sargentu kargua lortu zuen, 1987ko ekainean Teniente kargua eta 1991ko irailean Kapitain kargua. Perez Navarrete kondenatu eta bi urtera izendatu zuten Kapitain.

Barne Ministerioak kargu horien berri Epaitegian eman zuela ziurtatzen du. Hala ere, Donostiako Probintzi Epaitegiak jakinarazi ziotenik ukatu egiten du eta Barne Ministerioari azalpenak eskatuko dizkio.

## JOSE MARTINEZ SALAS

Jose Martinez Salas, (Nafarroa) Tuteran egin zen manifestazio ekologista batean Gladys del Estal hil zuen goardia zibila Meritu Militarraren Ordenaz, laugarren mailako ezaugarri zuriaz kondekoratu egin zuten iazko urriaren 12an herri horretan bertan.

Gladys del Estal hil ondoren heriotzea argitzeko batzorde ikertzaile bat eratu zen. Batzorde honek honakoa azaldu zuen denbora gutxira "Gladys del Estalen heriotzea inolako probokaziorik gertatu gabe izan zen". Goardia zibila "zuhurtzigabekeria ausartegiaz" akusatu eta 18 hilabeteko presoaldi txikira kondenatu zuten.

# TORTURA METODOAK

# 1. SARRERA

Estatu espainiarrean atxilotu eta inkomunikatutako euskal hiritarren testigantza eta bertan adierazitako tortura metodoen balorazio orokorretan ikus daitekeenez, hauek ez dira munduko beste lekuetan jasotakoen oso desberdinak. Estatu espainiarrean torturaren aplikazioa, jasotako testigantzen arabera, oso©oso konplexua da.

Lan honetan aztertutako 65 kasuetatik kasu bakarrean alegatu zen tortura psikologikoa, gainerakoetan tortura mota hau tortura fisikoaren batera gertatu zen. Ohizkoa kolpe, indarrez egin beharreko ariketa fisikoak, mehatxuak, gehiegikeria sexuala, umiliazioak, e.a. eta tortura metodo sofistikatuagoen (asfixia teknikak (boltsa, bainuontzia...) edo shock elektrikoa) arteko nahasketa bat da. Orokorrean, aztarnarik uzten ez duen torturaren aldeko joera badaukate ere, erabiltzen dituzte oraindik hain landuak ez diren teknikak (batik bat kolpeak). Auztiarako medikuen txosten askotan eta TATek oso gutxi eskuratu ahal izan baditu ere, makadura erako kalteak deskribatzen dira.

Tortura mota desberdinak testigantzen arabera aurkeztuko dira.

# 2. MATERIALEA

Ikerketak 65 euskal hiritar hartzen ditu kontutan, 15 emakume eta 50 gizon. Hauek esan zutenez, atxilotuta egon ziren denboran tratu txar edo torturak jasan zituzten.

65 kasu hauetan atxiloketa inkomunikazio erregimenpean izan zen Lege Antiterroristaren arabera, kasu bakar batean atxiloketa Ohizko Legeriaren pean egin zen.

60 kasutan Goardia Zibilak egin zituen atxiloketak, Polizia Nazionalak 4 kasutan eta Ertzaintzak (euskal polizia autonomoa) kasu batean.

41 kasutan atxiloketaren karia talde armatuari laguntzea izan zen, 11 kasutan talde armatuko kidea izatea eta beste 11 kasutan sabotaia edo kale desordenuaren akusaziopean egin zen. Bi kasutan ez dakigu atxiloketa zergatik gertatu zen.

Epaileak 65 pertsona hauetatik 37 kartzelaratu egin zituen, 10 behinbehineko askatasunpean utzi, 18 aske kargurik gabe, hauetako batzuk Epailearen aurrera agertu gabe.

TATko profesionariek kartzelara joan ez zirenen testigantza zuzena jaso zuten; kartzelaraturiko pertsonen testigantzak abokatu, senitarteko edo presoaren beraren bidez jakin ziren. Inkomunikazioa 35 lagunentzat 5 egunekoa izan zen, 18rentzat 4 egunekoa, 6rentzat 3 egunekoa, egun batekoa batentzat, 2 egunekoa beste batentzat eta 5 egunetik gorakoa beste batentzat. Atxiloketak kasu batean zenbat iraun zuen ez dakigu.

65 pertsona hauetatik 43 beren etxeetan atxilotu zituzten, 8 kalean, 6 lantokian eta 2 beste lekuren batean. 8 kasutan ez dakigu atxiloketa non gertatu zen.

Atxiloketa orduari buruz gehienak gauez gertatu ziren 1. grafikoan adierazten den bezalaxe.

Aurkezturiko 65 kasu hauek urteko gure txostenean jasotako lehenengo 65 kasuei dagozkie.

## 3. ALEGATURIKO TORTURA ETA TRATU TXAR MOTAK

2. grafikoan 1991 eta 1992 urteetan tortura fisikoen nagusitzea ikus daiteke. 3. grafikoan 1991 eta 1992an tortura metodo zehatz hori salatu zuten atxilotuen ehunekoa aipatzen da. 1. taulan maiztasuna, zenbaki osoetan, erabilitako tortura metodo desberdinak sexuaren arabera, atxiloketaren karia eta atxiloketaren ondorengo lege egoera ikus daitezke.

### a. KOLPEAK

Kolpeak dira gehien aipatzen den tortura mota, 63 lagunek (%96) adierazi zuten tratu txar mota hau jasan zutela. Gizon bat eta emakume batek baino ez zuten kolpeak jaso zituztela ukatu. Ez dago desberdintasunik banaketan atxiloketa karia, lege©egoera zein sexuari dagokienez.

1991ri dagokionez, "kolpeak" nagusitu egin ziren zertxobait (%91).

Kolpeak eskuez eman zituzten 43 kasutan, ostikoak 28 kasutan, ukabilez 25 kasutan eta telefono-gida edo egunkari batez 22 kasutan. 10 lagunek beste tresnaren batez kolpeak jaso zituztela adierazi zuten eta 9 kasutan ez dakite zerez edo ez dute zehaztu.

Gorputz atalik kolpatuena burua/aurpegia da (%100). Beste leku batzuetan 49 lagunek salatu zituzten, hauetatik 27k ernaltzeªorganoetan.

Kolpeen intentsitatea aldakorra da eta denetik dago, batzuek diotenez esku zabalka aurpegian emandako kolpeak jaso zituzten, beste batzuek, gorputz osoan jaso zituztela diote, esku, oin, ukabil, telefono-gida, e.a.ez. Buruan baino jo ez zituzten 14k, batek ezik, kolpeak oinekin (zanpatuko balute bezala) jaso zituztela esan zuten, gehienetan eskuez izan ziren (aurpegian) edo telefono-gida batez (kazkezur aldean). Gainerako kasuetan, kolpeen intentsitatea handiagoa izan zen.

Badago nolabaiteko zerikusia kolpaturiko lekua eta jotzeko erabiltzen denaren artean; aurpegi aldeko kolpeak gehienetan esku zabalka egiten dira eta telefono-gida ia beti kazkezur aldea kolpatzeko erabiltzen da; ukabil eta oinak gorputzaren gainerako atalak kolpatzeko erabiltzen dituzte. Atxilotu batzuek, gutxienez 2k, kolpeak jasotzen zituzten bitartean manta batez biltzen zituztela esan zuten.

Auzitarako medikuen 10 txostenetik, 4tan (%40) kalte traumatikoak agertzen dira, hauetako bi aurpegian (16. eta 41. kasuak), batean orno aldean (5. kasua) eta bestean gorputz osoan (4. kasua).

Lurra edo hormaren kontrako kolpeak 10 atxilotuk alegatu dituzte

(%15) eta guztiak gogor kolpatu zituzten bi gauza baino gehiagoz eta leku askotan.

Kolpe bidezko tortura berezi kasuak ez dira oso arruntak:

*Falangea: atxilotu bakar batek (%1) aipatu zuen tratu txar mota hau: "Batzutan manta batez estalia eta bestetan 4 goardia zibil edo gehiagok heltzen nindutela, oinak zapi batez estali zizkidaten eta gauza gogor baina malgu batez jo ninduten oinzoletan. Oinazea hain da handia ezen segundu batzuz konortea galdu bainuen eta hurrengo kolpeaz itzultzen nintzen nire onera. Minutu batzuetan atseden hartzen utzi ninduten, tarte horretan oinak hoztuz doaz, orduan berriro joka hasi zitzaizkidan eta oinazea are handiagoa zen".

*Telefonoa: bi pertsonak, bata Polizia Nazionalaren esku eta Goardia Zibilaren esku bestea, adierazi zuten asku zabalez belarri bietan jo zituztela.

*Beste batek, hau ere Polizia Nazionalak atxilotua, motorista kasko bat jarri eta gainean kolpeak eman zizkiotela adierazi zuen.

## b. AHITZE FISIKOA

Beste lan batzuetan bezala, ahitze fisikoaren barruan sartuko ditugu jarrera berean denbora luzea ematea (plantoia), ariketa fisikoak egin eta jarrera anomaloetan egotera behartua egotea. Guztira 45 lagun izan ziren (%69), 11 emakume eta 34 gizon, 1992an ahitze fisikoa jasan zutenak. Kopuru hau 1991ko ehunekoen antzekoa da (%70).

Lege©egoera eta sexuari dagokionez ez da desberdintasun nabarmenik ikusi. Atxiloketa karia sabotaia eta kale desordenua izan denean gutxixeagotan gertatu da (%54).

### b.1. Ariketa fisiko bortxatuak.

24 lagunek alegatu zituzten, 6 emakume eta 18 gizonek, denak Goardia Zibilak atxilotutakoak. Denak ahitu arte flexioak egitera behartu zituzten. Kasuren batean, biktimak espreski alegatzen du flexioak biluzik zegoela egin behar izan zituela.

### b.2. Luzaroan zutik egotea.

Tortura mota hau 30 kasutan aipatu zuten (%46), 7 emakume eta 23 gizonek. Orohar luzaroan zutik egotera behartzen dituzte hormari begira eta burua makurturik. Biktimak dioenez galdeketetan egiten da hori nahiz eta beste batzutan ziegan zeudela jasanarazi zieten. Atxilotu batek dioenez jarrera honetan zegoela eskuak bizkarrean esposaz loturik zeuzkan; beste bik beso zabalik egon behar izan zuten, hauetako batek jarrera honetan zegoela zenbait gauzari eutsi behar izan zion eskuez.

### b.3. Gorputz-jarrera anomaloak.

Gorputz jarrera anomaloetan egotera behartua izatea 9 pertsonak alegatu zuten (%13), emakume bat eta 8 gizonek. Gehienetan

atxiloketagunetik Madrilerako lekualdaketan (ordu batzuetako bidaia) gertatu zen.

## c. ITODURA

Atal honetan arnas-mekanismo arrunta eragozten duten tortura mota guztiak daude: urpekuntzia edo bainuontzia, boltsa, manta eta bestelakoak. Metodo honen maiztasuna 4. grafikoan agertzen da.

1992an, 46 lagunek (%70) teknika hauetakoren bat edo batzuk jasan zituela alegatu zuen. 1991n 24 lagun izan ziren (%64).

Bi urte hauetako kasuak aztertuz, metodoak atxiloketa burutu duen polizi taldearekin zerikusi handia daukala ikus dezakegu (5. grafikoa). Itodura mota desberdin hauek ondoren azalduko ditugu.

### c.1. Urpekuntzi edo bainuontzia.

Jasotako testigantzen arabera 1992an 13 lagun izan ziren (%20) tortura mota hau jasan zutenak. Aurreko urteko kopuruaren aldean hazkuntza nabarmena adierazten du honek, 1991n 3 lagunek (%8,9) salatu baitzuten.

Azpimarragarria da tortura hau jasan duten guztiak Goardia Zibilak atxilotu zituela, hau da, hein handi batean, 1992an praktika honek gora egin izanaren azalpena.

1991 eta 1992an tortura hau jasan zuten 16 lagunen arteko 12ri boltsa ere ezarri zitzaien, 3ri urpekuntzia baino ez eta eta bakar bati boltsa eta zulo naturalak ixtea (ahoa/sudurra). Talde armatukide izatearen akusaziopean zeudenek (%36) eta kartzelaratu zituztenek (%27) gehiagotan jasan zuten tortura hau. Sarriagoa izan zen ere gizonengan (%24) emakumeengan baino (%6).

### c.2. Boltsa.

Boltsa bat buruan jarri eta lepora lotuz egiten den tortura metodo hau itodura eragiteko naharoen erabiltzen dena da. Urpekuntzia bezalaxe, 1991n baino sarriago erabili da (%69 %40aren aldean), honen zioa Goardia Zibilak egindako atxiloketen hazkuntza da.

1991 eta 1992an "boltsa" jasan izana alegatu zuten 60 pertsonen arteko 58 Goardia Zibilak atxilotuak ziren, 2 baino ez Polizia Nazionalak eta Ertzaintzak bat ere ez. 2/5etan beste inolako metodorik gabe aplikatu zen.

Atxiloketa kariari dagokionez talde armatukide izatearen akusaziopean zeudenei %100 aplikatu zitzaien, talde armatuaren laguntzaile akusatutakoei %70 kasutan eta sabotaia eta kaleko desordenuaz akusaturikoei %27 kasutan. Maiztasuna handiagoa da kartzelaratu zituztenen artean (%83) kargurik gabe aske (%55) edo behinbehineko askatasunean (%40) gelditu zirenen artean baino.

Sexuari dagokionez, 9 emakumek (%60) eta 36 gizonek (%72) jasan izana adierazi zuten.

### c.3. Manta.

¼"Bainuontzia" eta "boltsa" ia esklusiboki Goardia Zibilak erabiltzen ditu, "manta", aitzitik, Ertzaintzak atxilotutakoek jasan zuten batik bat 1991n.

Ertzaintzak 1991n atxilotutako 9 pertsonaren testigantzaren arabera, manta bat erabiltzen zuten arnasa hartzea eragozteko (aurpegi eta lepoan bilduz). Gorputzean bilduz ere erabiltzen zen atxilotuari ariketa fisikoak egitera behartzen zitzaion bitartean, honek biktimari izerdi ugari eragiten zion eta galdeketa amaitutakoan ziegara eramatean tenperatura kontraste handia jasan behar izaten zuen.

1992an, jasotako testigantzen artetik, Ertzaintzak atxilotutako pertsona bakarrak ez zuen tortura era hau adierazi.

Kontsultatu dugun bibliografian ez dugu manta tortura teknika gisa erabili izanaren erreferentziarik.

**c.4. Bestelakoak.**

Atal honetan 5 kasu sartu ditugu; hauetan sujetuari zulo naturalak esku edo buruko batez estaltzen zaizkio. Bostgarren kasuan sujetuak dioenez, itodura eragiteko erpuru eta erakusleaz trakea estutzen zioten.

**d. ELEKTRIZITATEA**

Elektrizitate bidezko tortura gehiagotan erabili zen 1992an 1991n baino. 1992an 27 lagunek (%41) salatu zuen tortura mota hau eta 1991n 5 izan ziren (%13).

Bi urte hauetan elektrizitate bidezko tortura erabili zuen polizi talde bakarra Goardia Zibila izan zen, hori da areagotzearen arrazoia.

Deskarga elektrikoak salatu zituzten 27 pertsonen arteko 20 (%40) gizonak ziren eta 7 (%46) emakumeak.

Talde armatua laguntzearen akusaziopean zeudenengan maiztasuna %48koa izan zen, talde armatukide izatearen akusaziopean zeudenengan %36 eta sabotaia eta kale desordenuaz akusatutakoengan %9. Lege-egoerari dagokionez, eragina minimoa izan zen behinbehineko askatasunean gelditu zirenengan (%10), gainerako bi taldeengan maiztasuna handiagoa izan zen eta elkarren antzekoa.

Aplikazio gunea ugaria da eta orokorrean leku bat baino gehiagotan ezartzen dute. 12 kasutan, 9 gizon eta 3 emakume, ernaltze-organoetan ezarri zitzaien. Tortura mota hau erabili den guztietan, kasu batean ezik, kolpeak eta itodura mota desberdinak ere erabili dira.

Gutxienez bi atxiloturi elektrodoak arroparen gainean ezarri zitzaizkien. Bati, erabilitako tresna porra baten antzekoa iruditu zitzaion. Orokorrean, nekez zehaz daiteke erabilitako tresna zein den sujetuek begiak estalirik edukitzen baitituzte (txanoa, antifaza, benda, e.a.).

### e. ILEETATIK TIRATZEA.

Tortura mota zehazgabe hau 20 atxilotuk salatu zuten (%30), 1991ko antzeko kopurua (%32).

Atxiloketa karia, lege egoera eta sexuaren araberako desberdintasun nabarmenik ez zen somatu.

Atal honetan ileetatik tira zitzaiela aipatu zuten kasu guztiak daude, nahiz eta adats ateratzerik egon ez.

### f. ESTRES KLIMATIKOA

1992an 4 izan ziren (%6) estres klimatikoa aipatu zutenak, 1991n aldiz, %27 izan zen. Bi urte hauen arteko aldearen azalpena 1991n "manta"ren maiztasunean daukagu. Honek itodura eragiteaz gain hipertemia eta izerdia ere eragiten ditu, beraz galdeketa saioak amaitu eta sujetua ziegara eramandakoan (tenperatura hotzagoaz eta jantziak izerditan blai) hotza sentitzen zuen, baita hotzikarak ere.

1992an gertatutako 4 kasuak, 3 gizon eta emakume batek, tenperatura hotza jasan behar izan zuten, batek Madrilerako lekualdaketan (ordu batzuk) eta besteak ziegan bertan.

### g. ARGI BIDEZKO ERASOA

1992an tortura mota hau gizon bakar batek aipatu du; Goardia Zibilak atxilotu zuen eta Madrilerako bidean argüí-foko bat aurpegian jarri zioten begietan antifaza zeukala.

### h. BEHAR FISIOLOGIKOEI EUTSI BEHARRA

1992an aztertutakoen artean 5 atxilotuk, denak gizonak, adierazi zuten behar fisiologikoei luzaroan eustera behartu zituztela, batek kakagalea eta beste laurek pixagalea.

### i. URA ETA JANARIA UKATZEA

Ura edota janaria luzaroan ukatu zietela atxilotuen arteko 9k (%13) aipatu zuen, emakume bat eta zortzi gizonek, 1991ko kopuruaren antzekoa, ordukoa %16koa izan baitzen.

### j. ERASO SEXUAL FISIKO EDO PSIKOLOGIKOA

1991ko kopuruen aldean 1992an oso ugariak izan ziren tortura sexualak, hori eta eraso mota honen berezitasun eta konplexutasuna direla eta beste artikulu batean aztertuko dira.

2. eta 3. grafikoak (1991 eta 1992 urtean) gehiegikeria sexual espezifikoaren aipua dira eta ez dira ernaltze-organoetan

aplikatu diren beste tortura fisikoak (kolpeak, elektrodoak) adierazi.

## k. DERRIGORREZKO LORIK EZA

25 lagunek aipatu zuen hau (%38) (hauetako 24 Goardia Zibilak atxilotuak), 8 emakume eta 17 gizon. 1991koen aldean ehunekoa apur bat baino ez da areagotu (%27 izan zen) baina berbera izan zen (%38) 1991n Goardia Zibilak atxilotutakoak baino kontutan hartzen ez baditugu.

Talde armatukide izatearen akusaziopekoei aplikatu zitzaien maizen (%63), sabotaiak egiteaz akusaturiko 11 atxilotuek aldiz aipatu ere ez zuten egin. Era berean, maiztasuna handiagoa izan zen kartzelaratu zituztenengan (%48) gainerakoengan baino.

Praktika honen intentsitatea aldakorra da, batzuek ordu batzutako lorik eza eta egun batzuetan (ez beti) izan zela adierazi zuten, beste batzuek aldiz atxiloketak iraun zuen guztia (lauzpabost egun) iraun zuela adierazi zuten. Orohar atxilotutakoek esan zutenez, galdeketa naharo eta luzeez gain beste gauza batzuek eragozten zieten loa. Honela bada, etengabeko zaratak (altzari mugimenduak, urratsak, zerrailak ireki eta ixtearen zarata...), bapatean poliziak oihuka ziegan sartzea, torturaren beste biktimen oinaze-oihuak, e.a. nabarmen daitezke.

## l. IKUSMENA ERAGOZTEA

1992an 33 atxilotuk (%50) aipatu zuen tortura mota hau, 12 emakume eta 21 gizonek hain zuzen, denak Goardia Zibilaren jagotzapean. Ehuneko hau 1991koaren antzekoa da (%45).

Talde armatukide edo laguntzaile izatearen akusaziopean zeudenek sarriago aipatu zuten, eta gutxixeagotan sabotaiengatik atxilotutakoek (%9).

Praktika honen gogortasuna aldakorra da baina gehienetan atxiloketak iraun zuen bitartean iraun zuen honek ere, ziegan edo Auzitarako Medikuaren kontsultan zeudenean ezik. Ikusmena eragozten zuen gauza aipatzen denean, hau txanoa edo antifaza izan da.

## m. ETENGABEKO GALDEKETA

Etengabeko galdeketak tortura psikologikotzat hartzea ez da zehazten erraza, beraz eskaintzen ditugun datuak orientabide gisa hartu behar dira.

Galdeketak oso luzeak (ordu asko) eta errepikatuak zirela aipatu den kasuak sartu ditugu. Badakigu beste atxilotu batzuek ere halako egoera, edo okerragoa bizi izan dutela baina beren testigantzan ez dute halako tratu txar psikologikorik aipatu.

Aurretik aipatutako mugak eta guzti, 28 atxilotuk (%43) adierazi zuen tortura mota hau jasan zuela, 1991ko antzeko ehunekoa (%48). 28 hauetatik 24 gizon izan ziren eta 4 emakume. Talde

armatukideei sarriagotan aplikatu zitzaien (%63), talde armatuaren laguntzaileei ondoren (%41) eta minimoa sabotaiak egiteaz akusaturikoei (%27).

## n. INKOMUNIKAZIOA

Inkomunikaziopeko atxiloketa azterketa honetako pertsona guztiei aplikatu zaie, bakar bat izan zen ohizko legeriapean atxilotutakoa. Gainerakoak lege antiterroristapean egindako atxiloketak iraun zuen denbora guztian egon ziren inkomunikaturik. Atxiloketa denbora gorago aipatu da, beraz %50 kasutan inkomunikazioak bost egun eta beste %50ean lau egun iraun zuela baino ez dugu gogoraraziko.

## o. MEHATXUAK

Mehatxuak 49 lagunek salatu zituzten (%75), 14 emakume eta 35 gizon hain zuzen. 1991ko proportzioa ere antzekoa izan zen (%78). Hau da polizi talde desberdinen tratu txar psikologikorako praktikarik erabiliena. Ondoren tortura psikologiko hau burutzeko era desberdinen azterketa azalduko dugu.

### c.1. Heriotze mehatxuak

Gutxienez 35 lagunek bizi izan dute (%53), hauetako 8 emakumeak ziren eta 27 gizonak.

### c.2. Senitartekoen aurkako mehatxuak

Senitartekoen aurkako mehatxuak mota askotakoak izan ohi dira, atxilotu, torturatu, bortxatu, hil, e.a. egingo zietelako mehatxuak egin zizkieten. Tortura mota hau sarriago erabili da biktima senitartekoren batekin atxilotu izan dutenean. Hau 43 lagunek adierazi zuen (%66), 9 emakume eta 34 gizonek.

### c.3. Eraso sexualak egingo zituztelako mehatxuak

Tortura sexualari buruzko atalean agertzen dira.

### c.4. Tortura mehatxuak

Beste tortura metodo batzuk erabiliko zituztelako mehatxuak (orokorrean elektrodoak edo urpekuntzia) jasan zituztela adierazi zuten atxilotutako 27 lagunek (%41), 7 emakume eta 20 gizonek, hain zuzen.

### c.5. Bestelako mehatxuak

Atal honetan beste jite bateko mehatxuak sartu ditugu, hauek biktimaren "ahultasunen" batekin loturikoak dira. Emakume haurdun baten kasuan umea galduaraziko ziotela mehatxatzen zuten, mutilagunari, hau ere atxilotua, emakumeari umea galduaraziko ziotela esaten zioten. Haur txiki baten ama den atxilotu bati

haurraren jagote eskubidea kenduko ziotela esan zioten, bera eta mutilaguna kartzelaratu egingo zituztelako. Beste atxilotu bati HIESaz kutsaturiko orratz batez zulatuko zutela esan zioten.

Hamabi lagun izan ziren beste inon sailkatu ezin diren mehatxuak salatu zituztenak.

### p. ITXURAZKO HILKETA

11 lagun (%16) izan ziren hau jasan zutenak. Bat ezik beste guztiak Goardia Zibilak atxilotu zituen. Ehunekoa 1991koa baino zertxobait altuagoa izan zen, orduan %10 izan baitzen. Praktika hau jasan zutenen artean 3 emakume eta 8 gizon zeuden.

Maiztasun handiagoaz jasan zuten talde armatukide izateaz akusaturikoek (%36), ondoren talde armatuaren laguntzaile izateaz salaturikoek (%17). Sabotaiak egiteaz akusaturiko inork ez zuen halakorik jasan. Naharoagoa izan zen kartzelaratu zituztenen artean (%24) aske gelditu zirenen artean baino.

Kasu guztietan itxurazko hilketa saioa pistola batez egin zen, hau buruan edo ahoan jartzen zieten eta sujetuak "klik"a entzuten zuen, baina bala ez zen irteten. Tortura mota hau zehazkiago adierazi duten sujetuek begiak estalirik zeuzkatela esan zuten. Atxilotu batzuek itxurazko hilketa saioa mendian gertatu zela esan zuten. Atxilotuetako batek itxurazko hilketa saioa itxurazko urkaketa ere izan zela ere esan zuen.

### q. BESTEEI EGINDAKO TORTURAK ENTZUN EDO IKUSTERA BEHARTZEA

Tortura mota hau 17 atxilotuk salatu zuen (%26), 7 emakume eta 10 gizonek, guztiak Goardia Zibilak atxilotuak. Proportzioa 1991koaren antzekoa da (%29).

17 atxilotuek beste atxilotuen oinaze oihuak eta kolpe hotsak entzun zituztela adierazi zuten. Gutxienez lau lagun behartu zituzten senitartekoren baten oinaze oihuak entzutera. Bakar bat behartu zuten senitartekoari egindako torturak ikustera.

### r. IRAIN ETA UMILIAZIOAK

Aipatu tortura psikologikoa 35 atxilotuk salatu zuen (%53), 9 emakume eta 26 gizonek. Atxiloketa karia edo lege egoeraren araberako desberdintasun nabarmenik ez dago. Proportzioa 1991koa baino zertxobait baxuagoa da, %64koa izan baitzen.

### s. BESTELAKOAK

Jasotako beste tortura motak hauek izan dira: medikamentuak ukatzea hiru kasutan eta beste batean gorreriaren aurkako gailu baterako bateria ukatzea.

# TORTURA SEXUALAREN AREAGOTZEA 1992an

## SARRERA

1992an ugariak izan dira tortura sexuala aipatzen duten testigantzak. Tortura mota hau beste tortura metodo batzuekin erabili ohi da, fisiko zein psikikoak.

Euskal Herrian 1992an areagotu egin da tortura sexuala jasan izana salatu duten pertsonen kopurua.

Tortura sexuala oso traumatikoa da biktimarentzat, guztiz zaurgarri eta imaginatu ezin den babesik ez eta ezintasun egoeran ikusten du bere burua. Honez gain, aztarna ikusgarririk uzten ez duen eraso fisiko eta psikikoa da.

Honelaxe definitu zuten I. Agger eta S. Bus ek tortura sexuala "iharduera sexualaren edozein era eraso eta kalte fisiko zein psikologikoak eragiteko xedez erabiltzea". Autore hauen iritziz "tortura sexualaren xede nagusia presoaren nortasuna pitzatzea izan arren, tortura metodo hau presoaren sexualitatera bideraturik dago zuzen©zuzenean, torturatzaileek presoaren geroko funtzio sexuala nahastu nahi baitute".

## DEFINIZIOA. TORTURA SEXUALERAKO METODOAK

Honako gehiegikeria hauek dira tortura sexualtzat hartuko ditugunak:

A) multzoa: sexu-organoen aurkako indarkeria.

B) multzoa: eraso sexual fisikoa: kontaktu fisiko zuzena daramaten iharduera sexualak; kontaktua biktima eta animalia baten artekoa, biktimen artekoa, torturatzailea eta biktimaren artekoa edo hirurak batera izan daiteke. Guk hemen beste sujetua masturbaraztea ere erantsi nahi dugu.

C) multzoa: eraso sexual psikikoa: biluztasun derrigortua, umiliazio sexualak, mehatxu sexualak eta besteen tortura sexualak ikusi beharra.

D) multzoa: aurrekoen arteko nahasketa.

## TORTURA SEXUALAREN MAIZTASUNA ETA SEXUEN ARABERAKO BANAKETA

Aztertutako laginean (zeinaren osakera tortura metodoei buruzko atalean agertzen baita), tortura sexuala %72 kasutan gertatzen da, baina "A multzo"ko metodoak (zehazgabeagoak dira, gehienetan mina eragitea baitaukate helburutzat) baztertzen baditugu %49 kasutan agertzen da.

"A multzo"ko tortura sexuala 1992an 30 lagunek salatu du, 27 gizon eta 3 emakumek. 27 gizon horietatik 8ri elektrizitatea

ezarri eta kolpeak eman zizkioten sexu-organoetan, bati elektrizitatea baino ez eta 17ri kolpeak soilik. Hiru emakumeen artetik bati kolpeak eman eta elektrizitatea ezarri zioten gorputz atal horretan eta beste biri elektrizitatea. 15 lagun izan ziren nolabaiteko tortura sexuala jasan zutela adierazi zutenak. "B multzo"ko tortura metodoak, eraso fisikoa alegia, 14 atxilotuk alegatu zuen, 8 emakume eta 6 gizonek. Eraso sexual honekin batera doa gehienetan sexu-organoen aurkako indarkeria fisikoa (gizonen aurka batik bat) edo eraso sexual psikikoa (emakumeen aurka batik bat), edo biak.

Tortura sexual psikikoa 31 lagunek salatu zuen, 13 emakume eta 18 gizonek.

"Bestelakoak" atalean gauzen bidez (egunkarien antzekoak) inguru pubikoan 2 emakumeri egindako ikupenak sartzen dira, hauetako batek beraietako baten sexu-organoen gainean eseri eta kopulazio mugimenduak egin behar izan zituen, bitartean gorputza isurkin ezezagun batez zipriztintzen zioten.

Maginan gauza arrotzak sartzea bi kasutan erratz makila izan zen, beste bitan pistolaren begia, hauetako batek torturatzaile baten atzamarrak sartu zizkiotela ziurtatu zuen.

Uzkian gauza arrotzak sartzea, bestalde, bi kasutan pistola baten begia izan zen eta beste batean erratz makila.

Tortura sexuala naharoagoa da emakumeen aurka gizonen aurka baino (%86 %68ren aldean). Alde hau areagotu egiten da tortura sexual zehatzenak baino kontutan hartzen ez baditugu , "B eta C multzoak" (%86 %38ren aldean). Honek I. Lunde eta Thovalderrek sexuen araberako banaketaren inguruan egindako aurkikuntzak baiezten ditu. Era berean, tortura sexualaren praktikak agerian uzten du sexuarekiko desberdintasun handia. "A multzoko" (sexu©organoen aurkako indarkeria) tortura sexuala gehienbat gizonek alegatzen dute (%54 %20aren aldean): alderantziz gertatzen da "B multzoan", eraso sexual fisikoa, hemen %35 emakumeak dira eta gizonak %12, eta "C multzoan", eraso sexual psikikoa, %36 emakumeak dira eta %12 gizonak.

## TORTURA SEXUALA ETA ATXILOKETA KARIA

Atxiloketa kariaren araberako nagusitasunak hiru tortura motetan antzeko eta gehienezko banaketa adierazten du talde armatuko kide edo laguntzaile izateaz akusaturikoengan; sabotaia eta kale desordenuak egiteaz akusaturikoengan, gehienentan inkomunikaturik egon arren, askoz ere gutxiagotan gertatzen da, batez ere A eta B multzoetan.

## TORTURA SEXUALA ETA LEGE-EGOERA

Tortura sexuala eta atxilotuaren geroko lege©egoeraren arteko

lotura aztertzean ikus daiteke ez dagoela desberdintasun nabarmenik hiru taldeen artean (aske kargurik gabe, behinbehineko askatasuna edo kartzela) eta hiru tortura sexual multzoetan

## TORTURA SEXUALA ETA POLIZI TALDEA

Aldagarri honi buruz lortu nahi diren datuak ez dira behinbetikoak, atxiloketen arteko %90 Goardia Zibilak egina baita. Beste polizi taldeek atxilotutako inork ez zuen tortura sexual espezifikorik alegatu; Polizia Nazionalak atxilotutako lautik hiruk esan zuenez sexu-organoetan jo zituzten.

## TORTURA SEXUALA 1991-1992

Azterketa honetan eraso fisiko eta psikikoa baino ez ditugu landu, ez baititugu "A multzo"ari (sexu-organoen aurkako indarkeria) buruzko 1991ko datuak ezagutzen.

Tortura sexuala 1992an nabarmenki areagotu da, honelaxe adierazten genuen TATeko 1992ko maiatzean egin eta urtean zehar berretsi den txostenean. 1991n 7 lagun izan ziren eraso sexual fisiko eta psikikoa alegatu zutenak, 1992an aldiz, 32 izan dira. Areagotze hau nabarmena izan da ahozko gehiegikeria sexualaren kasuan (1991n %19 eta 1992an %47), baina are nabarmenagoa izan da gehiegikeria sexual fisikoen kasuan (%2 %21en aldean).

Kopuruan ezezik kualitatiboki ere areagotu da. Honela bada magina eta uzkian gauza arrotzak sartzea, norbera masturbatzera behartzea eta galdeketetan zehar biluzik egotearen beharra ere erabili dute eta hau psikologikoki oso traumatikoa da.

Tortura sexualaren praktikaren areagotzea hein handi batean atxiloketa burutu duen polizi taldearekin loturik dago, Goardia Zibilarekin alegia. Goardia Zibilak atxilotutakoak izan ziren hain zuzen ere 1991n tortura sexual psikikoa sarrien jasan zutenak eta talde honetan dago ere eraso sexual fisikoa salatu zuen bakarra.

## ONDORIOAK

1. Estatu espainiarrean orokortu egin da inkomunikazio erregimenpean atxilotutako euskal hiritarren aurkako tortura sexuala.

2. Tortura sexuala psikologikoki traumatizagarriena den tortura mota da. Ez du, gainera, aztarna ikusgarririk uzten.

3. Tortura sexuala aztertutako kasuen %72an gertatu zen. Sexu-organoen aurkako indarkeria fisikoa 30 lagunek salatu zuten, eraso sexual fisikoa 14ek eta eraso sexual psikikoa 31k. Sarriago gertatzen da emakumeen aurka. Emakumearen biktimizazioa tortura sexual metodo guztietan nabarmentzen da, sexu-organoen aurkako indarkeria fisiko kasuetan ezik.

5. Atxiloketa kariari dagokionez, tortura sexuala eta beronen metodo desberdinak naharoagoak izan ziren talde armatuko kide eta laguntzaile izateaz akusaturikoengan.

6. Tortura eta atxilotuaren lege-egoeraren artean ez dago lotura nabarmenik.

7. Tortura sexuala/polizi taldea azterketaren ondorioak ez dira behinbetikoak laginaren banaketagatik, baina badirudi tortura sexuala dela batez ere Goardia Zibilak erabili ohi duen metodoa.

8. 1992 eta 1991ko datuak erkatuz (sexu-organoen aurkako indarkeria metodoak aztertu gabe), tortura sexuala nabarmenki areagotu zen 1992an.

# TORTURAREN AURREKO ERREAKZIOZKO NAHASMEN PSIKIKOAK

Tortura da estres psikosozialik handiena sortarazten duen estimulua, biktimaren bizia edo osotasuna beraren aurkako mehatxua eragiten duen esperientzia traumatikoa baita, gizakiak eragina gainera. Hain da intentsua non erreakziozko nahasmen psikikoa garatzea, nahasmen horiek sortarazten dituzten agente estresanteen desoreka edo aurretiazko aurrejarrera patologikoen desoreka ahalbidera baititzake. Honela bada, tortura da estres postraumatikoaren ondoriozko nahasmenak sortzen dituen agente estresanteetako bat.

Aurretik aipatutakoaren adierazgarri ETA erakunde armatuko kide edo laguntzaile izatearen akusaziopen eta "Lege Antiterroristari" atxekirik atxilotutako (inkomunikaturik) hiru lagunek nozitutako erreakziozko koadro klinikoen azalpen txiki bat eskainiko dugu. Hauetako inork ere ez zuen inolako aurrekin medikorik gaisotasun psikiatrikoei dagokienez.

## 1.KASUA ANTSIETATE KRISIA (KOLDOBIKA NOTARIO)

Kasua hau 1991ko txostenean aipatu genuen.

33 urteko gizona da, 1991ko urtarrilaren 21ean atxilotu eta Polizia Nazionalaren egoitzara eraman zuten, ETAren laguntzaile izateaz akusaturik.

Hurrengo egunean Basurtuko Ospitale Zibilera eraman behar izan zuten. Hala eta guztiz ere bertan zegoelarik inkomunikazio egoeran egon zen.

Koadro antsiosoa diagnostikatu zitzaion. Ospitaleratu aurretik beraren egoeraren berri jaso zuen auzitarako medikuak bere txostenean (bertan sanital zentro batera eramateko aholkua ematen da), honela zioen: "Arlo psikologikoan sujetua angustiaturik dago, ahultasun afektiboa, taupadak, takikardiak, ikarak, izerdia

eta esku bietan inurridura dauzka, zoratzearen beldur da ("zoratu egingo naiz"). Bizitzen ari den tentsio psikologikoak areagoturiko ANGUSTIA KRISIA diagnostikatzera garamatza sintomatologia honek".

Ospitalean ansiolitikoak (Tranxilium 50) eman zizkioten, hala eta guztiz ere ospitaleratu eta 24 ordura auzitarako medikuak egindako beste txosten batean lehen deskribaturiko koadro kliniko bera zeukala adierazi zuen.

Atxilotuak komisaldegian presio psikologiko ugari jasan zuela adierazi zuen, hilketa mehatxuak esaterako, nahiz eta fisikoki hiru belarrondoko baino ez zizkioten eman.

### 2.KASUA DESOREKA PSIKOTIKOA (JOSU EGUZKIZA)

Kasua nazioartean salatu genuen bai guk eta bai giza eskubideen aldeko beste erakunde batzuek ere.

1992ko urtarrilaren 29ko goizaldean atxilotu zituen bera eta emaztea Goardia Zibilak.

Atxiloketan sujetuak aluzinazioak ikusi eta entzun zituen, hauei interpretazio eldarniagarriak emanez.

Adierazitako koadroa desoreka psikotiko baten (Erreakziozko psikosis laburra) adierazlea da. Desoreka hau subjektuak salatu zituen tratu txarrek (kolpeak, burua estaltzea, heriotze mehatxuak, elektrodoak, irain sexualak eta ahitzerarteko ariketa fisikoak) sortarazitako estresak eragina da.

### 3.KASUA BILAKATZE-NAHASMENA (KEPA URRA)

1992ko urtarrilaren 29an atxilotu zuten ETAko kidea izatearen akusaziopean.

Inkomunikazio ordu gutxira (Bilbo) Basurtuko Ospitale Zibilera eraman behar izan zuten eta bertan egon zen 9 egunez. Kalte traumatiko ugariz gain, auzitarako medikuak egindako txostenean honako koadro psikologikoa zeukala agertzen da: "Sujetua inguruarekin guztiz desloturik dago, peritu-azterketa unean estimulu mingarrien aurrean erantzuten hasten bada ere eta hau dirudienez ez zen ospitaleratu zutenetik gertatu (...). Inguruarekiko deslotura hori justifikatzen duen kalte organikorik ezean, badirudi atxilotuak bizi izandakoaren aurrean gertatutako bilakatze sindromea edo erreakzio psikogenoa diagnostika daitekeela".

Atxilotuak adierazi zituen tortura metodoen artean honakoak azpimarra daitezke: kolpe fisikoak, hilketa mehatxuak, itxurazko hilketa eta buruan boltsa jarriz itodura sortaraztea.

## EZTABAIDA

Gizonak, emakumeak eta batzutan haurrak torturatu egiten dituzte munduko herrialdeen heren batean (2). Zenbait herrialdetan, tortura atxilotu askoren aurka erabiltzen da. Beste batzuetan, Espainian kasu, tortura oraindik orain erabiltzen da baina lege antiterroristapean akusaturiko talde berezien aurka.

Artikulu honetan azaldutako erreakziozko nahasmen psikologikoak gutxitan gertatu izan dira torturan zehar edo beste edozein estres sakonaren aurrean.

V. Rasmussenek 200 tortura biktimekin egindako azterlan batean torturan iraundako denboran gertatutako sintoma psikikoak 14 aluzinazio kasu deskribatzen ditu, baina bere iritziz baliteke psikiatrak guztiak psikotikotzat sailkatu ez izana. Biktimetako 52k antsietatea zeukaten, inork ere ez zuen angustia krisia nozitu. Bilakatze-nahasmena ere ez da inorengan agertzen (3).

Atxiloketa eta tortura unean gertatutako estres erreakzioak aztertu dituen beste autore bat L. Weisaeth izan da; honek, torturaturiko 13 marinel norvegiarrek azaldutako sintomak balioetsi zituen, lagin horretan ez zuten izu atakerik, aluzinazio eta estres konfuntzionalik edo bestelako sindrome psikotikorik aurkitu (4).

Erreakziozko nahasmen hauek estresaren gogortasuna, mota eta intentsitatearen arabera baino ezin dira ulertu.

Muturreko egoera estresagarri batekiko jasankortasuna estimulu aldagarrien araberakoa ezezik (iraupena, intentsitatea, jatorria), biktimaren aurretiazko nortasunaren araberakoa ere bada (5 eta 6).

Adierazgarria da lehenengo kasuan beste biktimen aldean (hauek antsietate sintoma minimoak baino ez zituzten pairatu) tratu txar fisiko gutxiago nozitu arren antsietate krisia garatzen dela; honekin adierazi nahi da biktimaren buru-osasunerako tortura psikologikoa fisikoa bezain kaltegarria (edo gehiago) dela.

Aurkezturiko hiru kasuek inkomunikazioa/tratu txarrak/tortura lotura, antsietate-nahasmen, histeria-nahasmen edo baita nahasmen-psikotiko gisa ager daitezkeen buru-nahasmen berriak sortaraz ditzakeen estres psikosozial handiko estimulua dela adierazten dute.

## AUZITARAKO MEDIKUAREKIKO ELKARRIZKETARAKO BALDINTZAK

Ohizkoa da Auzitarako medikuek talde armatuko kide edo laguntzaile izateaz akusaturiko atxilotuak (komunikaziorik gabeko atxiloketa pairarazten zaienak) ikuskatzea.

Auzitarako medikuaren ikuskaketa honek ez du esan nahi atxilotuaren oinarrizko eskubideak errespetatzen direnik, mugapen garrantzitsuak baitaude.

Lehenengo mugapena atxilotuak Auzitarako Medikuarekiko daukan mesfidantza da. Jarrera hau hiru arrazoirengatik gertatzen da:

**a. Elkarrizketa gertatzen deneko giroa.**
Auzitarako Medikuak inkomunikaturik dagoen pertsona komisaldegian ikuskatzen du, beraz atxilotuak ezin ditu Auzitarako Medikua eta polizi funtzionariak egoki deslotu eta errepresio-aparatuaren ataltzat hartzen du, medikuak Giza Eskubideen bermatzaile den aldetik bete beharreko eginkizuna bazterturik geratuz.

Beste alde batetik, Auzitarako Medikuaren ikuskaketa ez da atxilotuaren eskariz egiten, poliziak beraiek dira atxilotuari ikusketaren berri ematen diotenak. Bere konfidantzako Abokatuak edo Ofiziozkoak ez dio atxiloketak dirauen bitartean medikuaren ikuskaketak edo profesionari horren kontrol betekizunaren jitearen berri ematen atxilotuari.

**b. Auzitarako Medikuaren baldintzagarriak**
Auzitarako Mediku gehienak ez dira ikuskaketa mota honen ezaugarri bereziak ulertzeko gai eta ez dute atxilotuaren konfidantza "bereganatzea" lortzen. Hau dela eta, elkarrizketak oso laburrak eta zuzenduegiak izan ohi dira; honela, atxilotu batzuek esan dutenez tratu txarren bat nozitu dutenentz baino ez diete galdetzen eta batzuetan azaleko ikuskaketa egiten zaiela. Ez dira inoiz ere aztarna mikroskopikorik uzten ez duten gehiegikeria fisikoak igartzeko teknika osagarriak erabiltzen, odol eta gernu azteketak edo erradiografiak kasu.

**c. Elkarrizketatuaren jarrera.**
Atxilotuaren jarrera balioesteko berbak aukeratzekotan mesfidantza eta beldurra aukeratu beharko lirateke. Atxilotuak ez daki atxiloketan zehar Auzitarako Medikuak ikuskatuko duenik. Horregatik, poliziak horren berri ematen dionean, mesfidantzaz eta errezeluz erreakzionatzen du. Ulergarria da zenbait zalantza edukitzea, batez ere tratu txarrak nozitu baditu eta salatzekotan poliziak gehiegikeria handiagoak egingo dizkiolako mehatxua luzatu badio.

- Auzitarako medikua da edo itxurak egiten ari den polizia?. Ezin ahantz daiteke ikuskaketa komisaldegian burutzen dela eta ez Justizi Administrazioari atxekiriko lokaletan eta medikua poliziek beraiek aurkezten diotela atxilotuari.

- Fida al naiteke Auzitarako Medikuaz?. Atxilotu askok Auzitarako Medikua (adierazi dugun giro horretan) errepresio aparatuaren atal dela uste du eta ez atxilotu den aldetik berak dauzkan eskubideen bermatzailea.

- Auzitarako medikuari tratu txarrak salatzen badizkiot ondorioak jasan behar izango al ditut?. Beraz, ez da harritzekoa inkomunikaturik dagoen pertsonak medikuaren aurrean kontrako errezelu eta beldurrezko jarrera hartzea.

Elkarrizketarako baldintzak azaldu ondoren oso zaila gertatzen da inkomunikaturiko pertsonak torturaz babesteko sistema bat daukala esatea. Kontrol sistema hau gainera, aipatutako mugapen guztiez, atxilotuak daukan bakarra da, ez epai-aginteak ez eta fiskalak

ere ez baitute eginkizun zuzenik atxiloketa baldintzak kontrolatzeko.

Atxiloketa kontrolatzeko bitarteko askiez hau tortura aplikatzen den eta mundu guztiko autoreek azpimarratu duteneko egungo inguruan kokatu behar dugu. Tortura "zientifikoaz" ari gara, biktimarengan inolako aztarnarik ez uztera bideraturiko torturaz.

Tortura, fisiko zein psikologikoa, egiaztatzeko eragozpen ugari dago eta batzuetan gaindiezinak dira. Eragozpen hauei beste espezifiko batzuk gehitu behar zaizkie Estatu espainiarraren kasuan; Espainiako legeriaren zenbait manuk tratu txarrak eskutatzeko eskaintzen duten babesa, aplikatzen den kontrol neurri bakarrak (Auzitarako Medikuaren ikuskaketak) dauzkan mugapenak. Elkarrizketa komisaldegian bertan gertatzen denez, mugapen hauek ez dira materialak soilik, funtzionalak ere badira, atxilotuak elkarrizketa garatzen deneko baldintzen aurrean daukan mesfidantza eta beldurragatik.

## INKOMUNIKAZIOA

Zoritxarrez gure Elkartera iristen dira oraindik tratu ezgizatiar eta anker edo torturen salaketa ugari. 1991n gertatu zen bezalaxe, gehientsuak Lege Antiterroristari atxekirik, INKOMUNIKAZIO erregimenpean atxilotutakoekin zerikusia daukate. 84/9 Legearen konstituzionaltasunik eza partzialki onartu zuen Konstituzio Auzitegiaren 87/1999 Epaitzaren ostean, Gobernuak lege berezi hori derogatu beharra dauka eta ohizko ordenamenduan barneratu, horretarako Zigor Kodean eta Auziperatze Kriminalerako Legean beharrezko moldaketak sartuz. Gaur egun ezin da esan legeria antiterroristarik dagoenik, ez baitago indarrean ustezko hauek araupetzera bideraturiko arau juridikorik. Hala ere, praktikan, begibistakoa da ohizko ordenamenduan badirela arau juridiko bereziak eta hauek erabilitako lege-teknikaren ondorioz ("bis" artikuluak, "....ren kasuan/izatekotan" erako eranskinak) "antiterrorismo" kasutan baino ez dira aplikatzen. Azpimarragarria da ohizko legerian barneraturiko artikulu hauek literalki LATn zeudenak berberak direla.

Talde armatuko kide edo laguntzaile izateagatik atxilotutakoan Epaileari inkomunikazioa dekreta dezan eska dakioke, honek arrazoizko ebazpen batean oinarrituriko erabakia eman behar du hogeita lau orduko epearen barruan. Inkomunikazio honek gehienez bost egun iraun ditzake, denbora horretan atxilotuari murriztu egiten zaizkio AKrL aren 520 artikuluak jasotzen dituen eskubideak. Era berean AKrL aren 527 artikuluak aldarazpen hauek ezartzen ditu:

a) Kasu guztietan Abokatua ofiziozkoa izango da.
b) Ezin izango dio atxiloketa eta unean unean dagoen jagotza zentroaren berri ez senitarteko ez beste inori eman.
c) Bere Abokatuarekin elkarrizketatzeko eskubiderik ere ez dauka.

1985ean AIk egindako balioespena, "inkomunikazioak (...) tortura eta tratu txarrak ahalbideratu zituen" alegia, gaur egun indarrean dago oraindik.

AKrL ak talde armatuarekin zerikusia daukaten atxilotuei ezarritako mugapenak eta AIren torturei buruzko txostenetik ateratako lerroaldearen arteko antzekotasuna "normalean, torturak bakartzea, bahiketak, ezkutuko atxiloketa/inkomunikazioa, abokatuaren urgazpenik eza eta senitarteko eta lagunekiko komunikaziorik eza dakartza".

Guzti honengatik ez da harritzekoa Torturaren aurkako Edesle Bereziak Genevan 1988an egindako GGEE aldeko Batzordeari "inkomunikazioa legez kanpokoa aldarrika zedin" aholkatzea.

Inkomunikazioa erabatekoa da eta senitartekoak, lagunak eta konfidantzako Abokatua ezezik beste edozein ere uki dezake. Honen adibidea badaukagu, 1992an aditu atzerritar bat, OCMT erakundeko Mejia Jn., gure elkartearen eskariz honaino etorri zen atxilotu eta gutxira Ospitaleratu (hemen torturatzen ari zirelako susmoa ere bazegoen) behar izan zuten atxilotu baten berri eduki eta bera bisitatu ahal izateko. Mejia Jn.ri ez zioten bisitatzen utzi eta tortura susmoak baieztatu egin ziren biktima bera zein oihuak entzun zituen erizain baten testigantzei esker (Kepa Urra kasua).

Horregatik uste dugu torturaren prebentziorako egiteko legezko bitartekorik baliagarriena inkomunikazioa eta honek dakarren eskubide murrizketa ezartzen duten artikulu guztiak derogatzea dela.

Giza Eskubideen aldeko Batzordeak Eskubide Politiko eta Zibilei buruzko Nazioarteko Itunaren 7. artikuluari buruz egindako iruzkinetan adierazi bezala, "tortura eta tratu ezgizatiar eta degradatzaileen aurkako borrokan biderik eraginkorrena atxiloketak sistematikoki erregistratzea da, atxilotuari mediku, abokatu eta senitartekoekin komunikatzeko aukera emanik, inkomunikazioa desagertaraztea (senitarteko, mediku eta abokatuak galdeketak ikus ditzakete, batez ere adin txikikoak direnean); honekin batera atxiloketa zentroak jende izendatu eta erakunde independienteek ©nazional edo nazioartekoak© bisitatu ahal izatea". (AI Torturak, 226 orr. aipua).

1988an terrorismo arloan zenbait berrikuntza egin ziren arren, AIk uste du bere azken txostenaren datan Legeria espainiarrak aipatu beharkizunei muzin egiten diela oraindik. (Ikus AI Espaá¤áa. Torturaren arazoa. AI eta Gobernu espainiarraren artean trukatutako agiriak. Madril, 1985. 13 orr.)

# KOMUNIKABIDEAK TORTURAREN AURREAN

## SARRERA

1992ko urtarrilaren 29an Goardia Zibilak ETAren Bizkaia Komandoaren aurkako polizi operazioari ekin zion, honen ondorioz, urtarrila eta otsaila artean 36 lagun atxilotu zituzten, hauetako 12 aske geratu ziren. Gehienek atxiloketa denboran torturatu egin zituztela salatu zuten, hau dela eta Abokatu defendatzaileak "Goardia Zibilak ETAko Bizkaia Komandoko kide edo laguntzaile

izatearen akusaziopean atxilotutako 36 lagunetik 24 kartzelaratu egin dituzte eta 12 kargurik gabe aske utzi, baina denek salatu dituzte torturak Epailearen aurrean egindako adierazpenetan" esan zuen (Egin 1992/3/4, 5. orr.).

**AZALEAN**

Polizi operazioa eta atxilotuek egindako tortura salaketen inguruan egunkariek emandako tratua ezagutzeko 92/01/29 (lehenengo atxiloketen data) eta 92/03/25 artean (Europar Parlamentuak atxilotuetako batek jasandako torturei buruzko txosten bat onartu zueneko data) agertutako berriak aztertu dira. Aztergai izan diren egunkariak Bizkaian gehien saltzen diren hirurak (bertan izan ziren atxiloketak): El Correo Espaá¤áol, Egin eta Deia; euskaraz idatzitako egunkari bakarra: Egunkaria; eta Estatu espainiarrean tirada handiena daukana: El Pais izan dira.

Polizi operazioari buruz agertutako berriak guztira (14 aldiz) torturari buruzko berrien kopuruaren
antzekoa da (13 aldiz).

Azterturako egunkarien artean ikus daiteke polizi operazioari buruzko berriak antzeko aldi kopuruan agertzen dira.

Egin da egun gehien eskaintzen dizkiona, jarraian El Correo eta El Pais, eta gutxien Deia eta Egunkaria.

Hala ere torturei buruzko informazioarekin ez da gauza bera gertatzen, hemen desberdintasun nabariak ikusten
dira. Datu bat azpimarratu behar da, Egin eta Egunkariaren artean aztertutako komunikabideetako azaletan torturari buruz agertzen den informazioaren %84,61 argitaratzen dute.

Eta hauek dira torturari eguneko berri gisa agertzeko behar besteko garrantzia eskaintzen dioten bakarrak (Egin, 2 egun; Egunkaria: 1 egun).

Aitzitik, El Correo eta El Pais©ek azalean torturari buruzko informazioa argitaratzen duten aldi bakarrean "aurkibidea" atalean egin dute.

**BARRUKO ORRIALDEEN AZTERKETA**

Ondoko koadroaren sailkapena berriaren titularraren edukiaren arabera egin da.

Egunkariak/ Polizi operazioa/ Tortura/ Mobilizazioak/ Iritzia/ Hemeroteka/ Sailkatu gabe/ Guztira

Bizkaia Komandoari buruzko informazioa barruko orrialdeetan.

Bizkaia Komandoak sortarazi zuen berri kopurua azpimarratzekoa izan zen, guztira 168, honek eguneko batez besteko 3 berri esan nahi du.

Egin eta Egunkaria dira torturari buruzko berri gehien argitaratu dutenak eta torturari buruzko berri kopurua (2. zutabea) polizi operazioari buruzko berriena baino handiagoa da (1. zutabea). El Pais©ek torturari buruzko berri bakarra jasotzen duela azpimarratu behar da.

Laburtuz, azterketa zehatzak luzeegi joko luke beraz, 2.1. atalean aipatutako ildo berari jarraitzen zaiola esan daiteke.

**EDUKIAREN AZTERKETA**

Orain arte emandako datuek egunkarien informazio tratamenduaren ikuspegia eskaintzen diguten arren, zifra hutsetan geratzen dira baldin eta informazioaren edukia aztertzen ez bada.

Espazio arazoak medio ezin dugu informazio guztia landu beraz bi puntu jorratuko ditugu:

- Atxilotuen testigantzak.
- ETAko Bizkaia Komandoaren aurkako polizi operazioan atxilotutako baten, Kepa Urraren, mediku txostena.

**ATXILOTUEN TESTIGANTZAK**

Atxilotuen testigantza da zalantzarik gabe, jendearen iritzia nolabait sentiberatzen duen aspektua, honek irakurleari pertsona horien bizipenekiko hurbilpen zuzena ahalbideratzen baitio.

Adibide gisa Bizkaia Komandoaren aurkako polizi operazioan atxilotu eta aske utzitako lauren testigantzak aipatuko ditugu:

"...buruan ito egiten ninduen plastikozko boltsa bat neramala flexioak egitera behartu ninduten, zenbait gauzaz jo ninduten eta deskarga elektrikoak ezartzen zizkidaten hanketan jartzen zidaten finkagarri antzeko gauza batez". (Egin, 92/02/07, 6. orr.)

"Lehenengo egunean belarrietako zoldura nuela jakinarazi nien baina ez zidaten medikamendurik eman. Madrilen biluztu eta bortxaketa mehatxua egin zidaten, erratz makila sartuko zidatela zioten, alabaren jagotza kenduko zidatela, lepoan jotzen ninduten. Azkenean pistolaren begia sartu zidaten maginan". (Egunkaria, 92/02/07, 7. orr.).

"Biluzik elektrodoak jarri zizkidaten barrabil, zakil, hanka eta oinetan" (Egunkaria, 92/03/04, 6. orr.).

"Animaliek jasan behar dituztenak baino gogorragoa izan zen lekualdaketa, ezgizatiarra, iraingarria. Ondoren Madrilen elektrodoak jarri zizkidaten gorputz osoan eta uzkitik makil bat sartzen ahalegindu ziren" (Egin, 92/03/04, 5. orr.).

Aztertutako egunkarietatik Egin eta Egunkaria dira torturak salatu dituztenen testigantza zuzenak jasotzen dituzten bakarrak. Adibide gisa, aske utzitako atxilotuek otsailaren 6an eta martxoaren 3an eskainitako pretsaurreetako informazioa dela eta, testigantzak Egin eta Egunkariako azaletan argitaratu ziren, barruko orrialdeetako berriaren titularrean eta 185 lerroko garapenaz Eginen eta 88koaz Egunkarian.

Beste alde batetik, Deia eta El Correok ez dute atxilotuen testigantzarik aipatzen eta informazioa honelaxe eman zuten:

"Auzitegi Nazionalak aske utzitako atxilotuetako 3 izan ziren bertan, Bilbo eta Madrileko Goardia Zibilaren egoitzan eduki zituzten bitartean jasandako ustezko tortura eta tratu txarrak zehatz©mehatz adierazi zituzten" (Deia, 92/02/07, 6. orr).

"Atxilotutako hirurek zehatz-mehatz adierazi zituzten Madrilen Goardia Zibilaren egoitzan eduki zituzten bitartean jasandako ustezko tratu txarrak". (El Correo, 92/03/04, 11. orr).

El Paisek ez zituen otsailaren 6 eta martxoaren 3ko prentsaurrekoak aipatu ere egin, beraz, atxilotuen testigantzarik ere ez du aipatzen.

Torturaren gaiaren tratamendu desberdintasuna nabaria da ere aipatu prentsaurreei buruzko berriaren titularra ikusiz gero. Hala ere Egin eta Egunkariak garrantzia aske utzitako atxilotuen testigantzen bidez adierazten dute:

"Azken atxilotuen testigantzek agerian uzten dute torturarena praktika sistematikoa dela" (Egineko titularra, 92/03/04, 5. orr)

"Bortxaketa bat, elektrodoak eta kolpeak salatu dituzte askatu berriek". (Egunkaria, 92/02/07. 7. orr).

Deia eta El Correok aipatu prentsaurreei buruzko berria ematean aipatu ere ez dituzte egiten atxilotuen testigantza zuzenak.

"Amnistiaren aldeko Batzordeek Bizkaiko Gobernadore Zibila torturatzaile izateagatik salatuko dute epai bidez". (Deia, 92/02/07, 6. orr).

"Amnistiaren aldeko Batzordeek Corcuera eta Vegaren adierazpenek torturatzaileei animoak ematen dizkietela uste dute" (El Correo, 92/03/04 11. orr).

**KEPA URRAri BURUZKO AUZITARAKO MEDIKUAREN TXOSTENA**

1992ko otsailaren 6an, aske utzitako atxilotuekin batera deitutako prentsaurrean, Kepa Landak Kepa Urrari buruzko mediku© txostenaren berri eman zuen. Kepa Urra Bizkaia Komandoaren aurkako polizi operazioan atxilotu zuten, ondoren (Bilbo) Basurtuko Ospitalera eraman behar izan zuten polizi egoitzan egon ondoren. Informazio hau ez zetorren gertakariei buruzko bertsio ofizialarekin bat eta kalte ugari egin zizkiotela adierazten zen. Beste Mediku Txosten batean, Kepa Landaren hitzetan, Kepa Urrak torturak jasan zituen ospitalean bertan, han kalte gehiago somatu baitzizkioten.

Egunkaria da mediku txosten hauei garrantzirik handiena ematen diena, beraiei buruzko aipua egiten du azalean eta barruko orrialdeetako berriaren titularrean, horrez gain, informazioa garatzeko 3 lerroalde erabiltzen ditu. Egin egunkarian mediku txostena berriaren laburpenean jasotzen da eta luze zabal, berriaren garapenean horretarako 7 lerroalde erabiliz. Deia eta El Correok, 3.1 atalean esandakoari jarraiki, ez dute txostena

aipatu ere egiten titularretan eta berriari lerroalde bakarra eskaintzen diote. El Paisek txosten horri buruzko informazioa ixiltzen du.

Otsailaren 14ean El Correo Espaá¤áolek eta hilaren 17an El Paisek aurreko astean jakinarazi zen eta hauek ixildu zuten txostenaren berri ematen dute. Oraingoan azalean argitaratzen dute eta barne orrialdeetan garatu. Azpimarratzekoa da El Correo zein El Paisen hauxe dela torturari buruz aztertutako denbora guzti horretan azalean ematen duten berri bakarra. Egunkari hauetako informazioak Kepa Urrak Ospitalean jasandako torturak aipatzen ditu eta ildo horretatik doa El Paiseko titularra: "Auzitarako Mediku batek etakide batek ospitalean tratu txarrak jasan zituelako aztarnak somatu ditu" (El Pais, 92/02/17, 15 orr). Ospitalean jasandako tratu txarrak gertatu ziren egun berean salatu zituen Amnistiaren aldeko Batzordeak eta halaxe jaso zuten Eginek "Kepa Urra kolpatu egin omen dute berriro Basurtuko Ospitalean" (92/02/01) eta Egunkariak "Ezpainak odoletan zituela aurkitu zuten Urra Basurtuko ospitalean". Informazio hau ez zuen ez Deiak ez El Correok ez eta El Paisek ere aipatu.

Deiak ez zuen mediku txostenari buruzko inolako informaziorik jaso, 92/02/15ean bertan ordea eta Bizkaiko Gobernadore Zibila den Daniel Vegaren adierazpenen ildotik titular hau jaso zuen: "Vega: Epaileek erabakiko dute Kepa Urra kaltetu zutenentz".

**ONDORIOAK**

Lan honetan zehar ikusi ahal izan dugu aztertutako egunkarietatik Egin eta Egunkariak baino ez daukatela tortura salatzeko jarrera aktiboa. Egin (14 urtetik gorako biztanleen arteko audientziaren %7) eta Egunkariaren (%1,4) artean euskal biztanlegoaren %8,4arengana baino ez direla heltzen abiapuntutzat hartuz, esan daiteke euskal biztanlegoaren gehiengoak ez daukala torturaren praktika edo beronen benetako dimentsioaren inolako berririk.

El Paisek, hain zehatz aztertu ez diren estatu mailako beste batzuen antzera (ABC eta El Mundo), Euskadin gertatzen den torturaren inguruko ixiltasun informatiboa praktikatzen du. Zalantzarik gabe, gertakari honek adierazten duena estatuko biztanleek horri buruzko inolako berririk ez daukatela da.

El Paisen informazio hutsunea eta Egin eta Egunkariaren salaketaren artean daude El Correo Español eta Deia informazio mugapenaz, bai berriak zein hauen edukia ixiltzeaz, eta halaxe ikusi ahal izan dugu bi eta hirugarren ataletan.

Deia, El Correo Español eta El Paisek atxilotuen testigantza zuzenak ixiltzeak argi uzten du egunkari hauentzako atxilotuen salaketa ez dela tortura salatzeko nahikoa. Tratu txarrak auzitarako medikuen txostenetan agertu arte itxaroten dute nolabaiteko sinesgarritasuna emateko eta epaitza benetan badirela egiaztatzeko.

Komunikabide gehienek egiten duten tratamenduaren ondorioz (mediku txostenetan agertutako tratu txarrak = tortura aztarnak; eta torturari buruzko epaitza = badirela egiaztatzea), komunikabideek tortura estatu espainiarreko komisaldegietan gertatzen den aparteko gauzatzat hartzen dute.

Tortura, Amnesty Internationalek 1984eko bere Urteko Txostenean adierazten duen bezalaxe, "horrekin lortu nahi dena alde batera utziz, giza duintasunaren aurkako eraso neurtua da, eta arrazoi hori nahikoa da erabat salatzeko". Tortura frogatzeko dauden eragozpenak kontutan hartuz, beharrezkoa da gizarte eragile guztiek torturaren praktika salatzeko jarrera hartzea, eta horretan komunikabideek (jendearen iritzia itxuratzen dutenak diren aldetik) berebiziko eginkizuna daukate.

Torturaren informazio tratamendua gertatzen deneko lekutik bereiztea (atxilotuaren inkomunikazioa, nahi duen abokatua izandatzeko ezintasuna, peritu txostenaren mugak, frogatzeko eragozpenak...) ez da nahikoa XX. mendeko lakra hau desagertarazi nahi badugu.